URKIAGA'TAR ESTEPAN
(LAUAXETA)

# BIDE-BARRIJAK




# NUEVOS RUMBOS



BILBAO 1931
Emeterio Verdes Achirica
Correo, 9 y Cruz, 5

# ITZAURREA

## ''BIDE BARIJAK''

*Eusko-olerti Irakuskundea.*

Atzeŕian, nunbait, olerti-antzua nabaitzen da. Olerti ituŕia agortu edo olerkariak aitu diralako. Aŕotz elertietan poesi zelaiak zeken eta elkor dakuskigu. Ez soroak laŕatz daudelako, noski, gun-muña zekendu zaiotelako baizik.

Ez dira gauŕkoak, Nuñez de Arce'n alaka- ukoŕak:

«La Virgen poesía
Huyendo de los hombres,
Se pierde en las profundas
Tinieblas de la noche.
¡Todo se anubla, todo
Choca, todo esta herido!
Pide estragos el arte
Su inspiración al vicio».

Antziñako olerkari gorenak ez dagerz. Alaka eta soilki, moteltxoak eta goitilunagoak sortzen zaizkiote. Ez len-ainbat ospe-iraunkor iritxiko dutenik, alegia.

Euskera, oraingoan, iñoiz baño oparotsuago, ordea. Izkera beŕiak auldu diranean, eusko ele zaŕa gaztaro emankoŕera datorkigu. Altzo sakonetik irasiaz olerkari emaitzak emaro eskaintzen dizkigu.

# PRÓLOGO

## ''NUEVOS RUMBOS''

*La epifanía de la poesía vasca*

En el extranjero se advierte cierta esterilidad poética, que afecta a casi todas las naciones. El manantial de la poesía se ha agotado o los poetas se extinguen. En las literaturas extranjeras nos llaman la atención los campos de la poesía que yacen marchitos y estériles. Sus frutos son mezquinos en alto grado. No ciertamente porque estén incultivados, sino por cuanto su savia se ha secado.

No son del día que corre, aquellos lamentos pesimistas de Nuñez de Arce:

«La Virgen poesía
Huyendo de los hombres,
Se pierde en las profundas
Tinieblas de la noche.
¡Todo se nubla, todo
Choca, todo esta herido!
Pide estragos el arte
Su inspiración al vicio».

Los excelsos poetas de ayer no remanecen en parte alguna. Les sustituyen algunos quejumbrosos y solitarios, sin un adarme de inspiración.

*Aizken emaitz gorena*

Esku-tartean daukazu, irakurle.

Adi-biotzez, eusko olerkariak emaitza daskaintzu. Poesi-neurtitzak, geyenetan, alako zerutar kutsuak ikutuak diralako goitanak izaten dira. Begi aunean dituzunak goyenetakoak bezela iritziko dituzu, laister.

Olerki egilea gaztea degu, oso. Ogeitalau urteak, doi-doi, beteak ditu oraindik Urkiaga tar Estepan jaunak. ¡Iñoiz ikusigabea gaurdaño! Gaztaro asieran, besteak zartzaroan eskeintzen digutena, jolas-eran «Lauaxeta'k» dopalkigu. Neurtitzok olerkari gaztearen gogo osoa daramate. Sare-mea izaki poesia bere ari goitar artean gogapen, irudi ta naipenak ez atzitzeko,

¿Olerkaria nor dan ikasi nai zenuke? Bere amets garden zintzoei so-egiezu.

*Tolesgeko olerkaria.*

Urkiaga'ren neurtitzak altzotik zintzotasun luŕinkaia zabaltzen dute. Aldakoŕa da, noski, gogoa; igikoŕa, berez, naimena. Olerkariaren lipar ilunak, eta izatez adi-gaitzak diran biotz zadoŕak igartzea neurtitz gardenen bidez jadetsi genezake, nai izanik.

Olerkiok, «Lauaxeta»'ren bizikera erdibitua darakusgute. Gaztetxoaren gogo-artega lañotsua, lengengoz, dager. Bizitz elburuak urduri dakarzkio, adi-irudiak. Iñoizka maitasun izpiak bidea dargiote. Galen atzapaŕak biotza uŕatzen, bereala ordea.

Ara gaztearen barnean buŕuka sortu. Guda onek amaika naigabe ta alegetasun olerkariari iritxi dizka. Guda ostean, maite miñez zauritua datza olerkaria. Ez

No alcanzarán los actuales la fama imperecedera de aquéllos. En cambio, el Euzkera, por rara fortuna, se nos muestra pródigo cual jamás lo fuera. Al debilitarse las lenguas modernas, el idioma venerable de los vascos consigue una juventud fecunda y espléndida. Procreando en su seno profundo, nos ofrenda dulcemente, los divinos frutos de la poesía.

*El excelso regalo presente*

Entre tus manos lo posees, lector.

El poeta vasco te ofrece sus frutos nacidos de la inteligencia y del corazón. Los versos suelen ser siempre anhelos de eternidad porque han brotado al golpe de un dejo superior. Pronto habrás de apreciar como altísimos estos que están ante tus ojos.

El poeta es joven, muy joven todavía. Esteban de Urkiaga. Caso insólito, en verdad, hasta el día de hoy! En sus años juveniles nos regala «Lauaxeta», como si estuviera jugando un deporte, lo que otros nos prometen en su ancianidad venerable. Estos versos nos manifiestan todo el alma del joven poeta. Finísima red que tiende a la poesía sin engañar entre sus hilos los pensamientos, las imágenes y las ansias.

¿Quisiérais conocer al poeta? Mirad a sus fieles y transparentes ensueños.

*Poeta sin dobleces.*

Los versos de Urkiaga derraman un aroma de sinceridad. El alma, es sin duda, voladora; la inteligencia, inquieta, por esencia. Pero queriéndolo así, podemos comprender en la transparencia de sus versos los momentos tristes del poeta y los misterios ocultos del corazón, que son tan difíciles de captar por medio de la inteligencia.

Estas poesías nos muestran la vida partida en dos, de «Lauaxeta». El alma inquieta, entre penumbras, del jovencito en primer término. La finalidad de la vida le presenta inquieta las imágenes de la inteligencia. Con frecuencia los rayos del amor le señalan el camino. Pero al momento, la mano del desengaño le punza el corazón.

onen edo aren maite miñez, maitasun utsaren maite miñez baizik.

Iñoizka gogo begiak olerkariari lausotzen ote zaizkan nago. Agian, bidexuretatik jo aren ere, beti egi-bide bakarera datorkigu. Eta zalantza aundirik gabe, geienetan.

Poesi batzuetan atsege, pozge daurkizute «Lauaxeta»; neketsu, aul-antzean, egoak tolestutan Egoak, beti, garden eta sotil iraungo diote olerkariari; gogo zintzoa bezin garbi.

*Maitasun lei aiotsak.*

Barneko maite lei au eusko elertiari onurakora zaio. Olerki bikañak sortu azi dizkio. Oraindaño ez lakoak. Alegia, azalez eta gun-mamiz, maitasun gaiz beterik daudenak.

Maitasunak darabilki, olerkaria, bide zoragarietatik. Maitasun gaiok irudi arigariz, oi ez bezelako amets ereduz apaintzen ditu. Oraindaño eusko olerkiak jazteko asmatu ez diran amets irudi beriz, noski.

Maitasun-egiaz, biotz-ikutzez, azal-ederez oparotsua, gazte onen, olerti emaitza.

«Erantzuna», «Jadetsi-eziña», «Mao goria», «Abaua», «Gazte Gaxua», «Iluntzeko ixara», «Gabeko irintzia», «Ituri negara», «Maitale Kutuna» eta abar ¿maitasun aiotsak besterik ote dira? Edertasun zoragariz kutsututakoak neretzat, beintzat. Alako atsege ta lausotasuna badaramate, noski, baña baita gogoa ikutu eta adia asetzen duan goitar indara ere. Oldargi zorotz eta biotz ikarak sortuak ba-dira!

He aquí cómo brota en el interior del joven, la lucha. Esta lucha le ha acarreado mil penas y amarguras al poeta. Y al final de la contienda, queda malherido de amor. No por este u otro amor, sino por la nostalgia de un amor sin aditamentos de ninguna especie. El amor en sí.

Creo que algunas veces se le anublan los ojos y el alma. Aparentemente, camina por senderos encrucijados, pero siempre viene al único camino de la verdad. Y sin grandes vacilaciones, las más de las veces.

En algunas poesías le encontraréis triste y enlutado a «Lauaxeta». Con un gran dolor, como cansado del todo y con sus alas plegadas. Pero las alas transparentes y sutiles matendrán siempre al poeta: El alma serena y fiel.

*La voz de las ansias de amor.*

Este anhelo interior de amor le es muy provechoso al idioma vasco. Le ha ofrendado poesías escogidas. Tales, cuales no han existido hasta el día de hoy.

En verdad, están exornados por dentro y fuera con temas de amor muy selectos,

Por caminos maravillosos le lleva el amor, al poeta. Y sus esencias poéticas de amor se revisten de imágenes, de ensueños jamás sospechados entre nosotros.

Nuevas imágenes y comparaciones que no habían nacido para adornar la poesía vasca. La ofrenda poética de este joven, es úberrima en verdadero amor, en sentimiento íntimo, en sutilísima forma exterior.

«La Respuesta», «Anhelo Inlograble», «El clavel rojo», «El Panal», «El Joven enfermo», «La Estrella Vespertina», «El Irrintzi Nocturno», «El Llanto de la fuente», «La Enamorada Predilecta» y otras muchas, ¿son otra cosa que gemidos y voces del amor? Ciertamente para mí, sembradas de bellezas admirables. Llevan en sí cierta tristeza y sentimentalismo, pero también la fuerza espiritual que iluminan el alma y la inteligencia. Animo luminoso y agudo y un corazón sentimental han sido parte para su floración.

*«Olerti utsa».*

«Bide beŕijak» dasa idaztitxo onek. Bide beŕietatik dabil aizken aldera, gure olerkari zoŕotz au. Euskera, poesi bidez, erabeŕitu nai; osertz neuŕigabeak darikizkio. Aberastu dedin ontasun ugariak dakarzio.

Maite minkuntasun basoak lagata, adi zelaietara datorkigu olerkaria. Ara bere goitar indaŕak noruntz daramakin, «olerti-uts» aranetara.

France'n, batez ere, poesi gaia, aldakuntza gogoŕa jaso beaŕean dago. Olerkariak, buru-belaŕi, era beŕiak sumatzen ari dira, olertiak goratu eta edertzekotan. Bremond, Valery, Claudel eta Souza «poési pure», «olerti-uts» bidexuŕetatik jo ta, poesi osertza zabaltzeaŕen leiatsu dabiltza.

Adi poesia, oldozkun olertia, olerti galuŕenetzat daukate. Ituŕi garden, aran sotil, baso itzal, mendi zoŕotz, maite min eta minkuntasunak beratutako gaiak goiaŕ biarentzat egokienak dirala ez uste; beste alako gai sakon eta barnekoak, adikoŕak alegia, olerkari kementsuenentzat berekikoenan zaizkiotelakoan egon ginezke, ertilari oiek dasatenez.

«Lauaxeta» oien kidekoa zaigu. Aizken neurtitz saletan, eztabaidarik gabe, poesi uts zalea dagerkigu. Gaztetasun biozkadari uko egiñik, adi jauregi barnean itxi zaigu.

Oldozkun gorenak, asmo mee luŕungeak lagun, adimena nagusi, irudipena moŕoi dituala, olerti bide beŕitik jo digu. «Jaungoikotija», «Itxasora», »Itzarik», «Artxanda-ganian», «Jaunagan atsedena» eta «Ezilkortasuna» poesi-uts esi barnean dagozenak dira.

*La poesía pura*

«Nuevos Rumbos» se titula este librito. Hacia la postrera parte, este nuestro poeta, camina por rumbos nuevos. Por medio de la poesía quiere renovar el euzkera, le enfila hacia horizontes sin términos. Para que se enriquezca le trae úberrimas bondades.

Abandonando los bosques de un amor sentimental llega a los prados de la poesía intelectual. He aquí cómo su fuerza superior le trae a los terrenos de la «poesía pura».

El tema poético está a punto de sufrir un cambio radical, sobre todo en Francia. Los poetas se esfuerzan, con todo entusiasmo y ardor, en buscar nuevos derroteros, nuevas formas, con el fin de sublimar y hermosear la poesía. Bremond, Valery Claudel y Souza discurren por los caminos de la «poesía pura» para ensanchar los límites de la poesía.

Consideran como la poesía suprema la que cristaliza en ideas, la que es fruto de la inteligencia. No creais que son los temas más apropiados para la inspiración las fuentes cristalinas, los valles silenciosos, los bosques sombreados, las cumbres agudas, las nostalgias de amor y las sensiblerías; según criterio de estos literatos modernos, existen otros temas más profundos e interiores, temas intelectuales, para los poetas atrevidos y nobles.

«Lauaxeta» se cobija bajo el mismo techo. En las poesías últimas se muestra encariñado de la «poesía pura», sin timideces ni dudas. Dando de mano a las ternuras juveniles, se nos ha cerrado en el palacio de la inteligencia.

Con pensamientos profundos, portando por compañía sutiles ideas, apenas nubladas, con la inteligencia por directriz y la imaginación por esclava, se nos ha marchado por los nuevos rumbos de la poesía. «Divina», «¡A la mar!», «Vigilante», «Sobre el Archanda», «La paz en el Señor» y «La Inmortalidad» están de lleno en el círculo de la poesía pura.

En el cielo de las ideas el poeta levanta hacia las alturas su facultad creadora. Con verdadera selección de temas intelectuales, revistiéndolas con vestiduras sin cuerpo ni envoltura terrena, las encierra en hermosos versos.

Almena, oldozkun ortsean goruntz darabilki olerkariak. Adi-gai bereziak, irudi gorputzgeaz jantzita, apain neurtitzen ditu. Mindun biotz, ber-bera, lur ikutzeke gorenetara igo digu

*Ezilkortasun zirikada*

Galurera igotzeak ez ase olerkariaren lei ilezkora. Bizitz arazoak urduriturik dauka bere gogoa. Len, matagaiak biotzean min; orain adi poesiak barnean gara piztu. Betikotasuna biotzean so-dagi. Biziki dasa:

«*Gomuta ezilkortu nai dabe gixonak...*
Urtiak baduazi, uratzik eztager,
Non galtzen dira-edo?
¡Albaneuke uler!
Gixon-uts nazan aren, eztot deuzeztu nai;
Naikun oneik ez ete ezilkortasun gai?»

Olerkari bikañenak ezilkortasun aiotsak entzun izan dituzte. Gure gazte onek ere dei oren oiartsuna neurtitzetan dagerkigu.

Poesi goiargiak lagun bekio ezilkortasuna irixteko. Adi-ego egokiak ditu naikuna betzeko.

Euskerari, bide latza, leguntzeko, «Lauaxeta'k» dagiana, ez da lan makala. Bere «Bide barijak» goren, txalogariak.

Olerti-uts zelaietatik juan bedi. Nekeak ez dezala auldu; ain da galgaria bide ori. Oraindañokoan bulartsu daraikio.

Ez bezaie, ordea, maitasun gaiei, minkuntasun asmo samorei uko egin. Ain olerki politak egin dizkigu ¡Ain gogokoak ditut gatxaro asierako neurtitz oiek!

Adi-poesi eta maite-olerkiak ez-ezik beste gun edera dituen elerkitxoak aurki lezazkike irakurleak.

Aquel mismo corazón dolorido, posee aun hoy en día, pero ha ascendido hacia las alturas sin tocar la tierra.

### *El ansia de inmortalidad.*

Pero las ascensiones no han satisfecho las inmortales ansias del poeta. El problema de la vida retiene en perpetua inquietud, su alma. Antes, los temas amorosos, le punzaban el corazón; ahora la poesía intelectual ha encendido la llama en su interior. Vislumbra en su corazón la esencia de la inmortalidad. Agudamente exclama:

«Los hombres quieren inmortalizar su recuerdo...
Pero los años huyen, no queda rastro alguno;
¿Dónde se esfuman?
¡Si lo pudiera comprender!
Aun cuando sea hombre, tan sólo, no quiero perecer;
¿No son dignas de inmortalidad estas ansias?»

Los poetas más selectos han escuchado las voces de la inmortalidad. Este nuestro joven nos trae también en sus versos el eco de esta llamada.

Que la inspiración le acompañe para conseguir esa inmortalidad! Tiene alas intelectuales muy capaces para conseguir su anhelo

No es pequeño trabajo el que «Lauaxeta» hace para allanar los caminos ásperos del idioma vasco. Sus «Nuevos Rumbos» son profundos y dignos de elogio.

Camine por los senderos de la poesía pura. Que el dolor no le acobarde: ¡es tan temible ese camino! Hasta ahora le ha emprendido sin temor alguno.

Pero no abandone los temas amorosos, aquellos tiernos sentimientos del corazón.

¡Nos ha regalado tan escogidas poesías! ¡Me son tan queridos aquellos versos de su comienzo juvenil!

Pero el lector podrá encontrar también otras poesías que tienen un tema escogido y están fuera de los temas intelectuales y amorosos.

Uskurtz,atsak ikututako biozdunak badira. Oñaritzat zinismen sendoa dutenak: edergaritzat, gaurdaño entzungeko, iduri mee-goitarak.

Gaur, Urkiaga olerkariaren agerkundea dakusgu. Gaztea izanik ugaritsu datorkigu.-Oparitsu badator, edertzale ordea. Banatutakoak dira, txorta onetan daskeñizkigun loreak. Mota askotakoak, baña guziak bereziak.

Biotzean aukeratutako kimu aratzak.

*Aitzol'dar J.*

Donostia'n



Son sentimientos que llevan el dejo de la Religión. Entraña una profunda fe en sus versos: como vestidura llevan sublimes y sutiles imágenes, hasta el día de hoy no escuchadas en euzkera.

Hoy es la epifanía del poeta Urkiaga. Siendo joven llega con ópimos frutos. Pero si se acerca ubérrimo, se muestra al mismo tiempo amante de la belleza.

Son verdaderas flores, las que nos regala en este tomito. De muy distintas variedades, pero todas muy selectas.

Ramas espléndidas, seleccionadas dentro del corazón.

*J. de Aitzol.*

San Sebastián.



# Eskeintza

*Basaratz'tar Bingene*

*Urkiaga'tar Joseba Mirena*

*guraso maitiai, bijotzez opalduten*

*dautset olerki-txorta au.*

## Dedicatoria

*A mis queridos padres,*

*Vicenta de Basaraz*

*y*

*José María de Urkiaga*

*dedico con todo amor, este mi libro de versos.*

## Gexorik nago

Zer dodan eztakit, baña gexo nago:
gorputza aul daukot, gogua ariago
Arratsari nago..., itxas-urdiñari,
lanari el-ezin, soilik ametsari.

Barnera so-dagit: gabeko itzal-antzo,
Iexa barru ontan ezin dagit zantzo.

Lar gozartu baitot bixitzaren guna:
¡legor dira lorak, il maitetasuna!
Len eder yatazan mendijen gallurrak,
zorijon-didarra egisten edurrak.
¡Oso nintzanian lurra zan ederra!
Espanak mosuba, bijotzak eskerra.

¡Ene gogo leuna, zatorz egotara!
Ume gexo-legez zatzaz galdatara.

Bidazti ez beti. Ez ibilli aron.
Bijotz aul orrek, ez gurenai yaramon.
Zidor ori nora? Eztauko azkenik...
Itxi, arren, eta ez leyatu goirik.
Maitatu arratsa, landatu oroya,
ekiñai ezinik, bildu goiz-otoya.
Egun gitxi arren, nekatu naz oro.
¡Bixitza nork txastau leikian unoro!

# Estoy enfermo

No se lo que sufro, pero estoy enfermo:
tengo muy débil el cuerpo, pero mucho más el alma.
Por eso, amo el atardecer......, el azul de los mares,
no puedo sujetarme al trabajo y tan sólo me agrada el soñar.

Ausculto mi corazón: todo semeja una noche oscura.
Yazgo en una profunda caverna y no puedo llamar a nadie.

He gozado en demasía de las dulzuras de la vida;
y se han marchitado las flores, se ha muerto el amor.
Antes me atraían las cumbres montañeras,
me enviaban un mensaje de felicidad las nieves.
¡Cúan hermosa era la tierra cuando estaba sano!
Los labios tenían un beso, los corazones un agradecimiento.

¡Oh, alma mía suavísima! ven a tomar el calor del sur,
como un niño enfermizo duerme a la lumbre del sol.

No quieras ser siempre viajera. No andes vagando.
Corazón debilitado, deja todas las hermosuras.
Preguntas a dónde va el camino? No tiene término alguno!
Por piedad, déjalo, no ambiciones las cumbres.
Ama el atardecer..., cultiva el recuerdo,
deja las realidades y reconcéntrate en la oración mañanera.
Aun cuando hayas vivido pocos años, te sientes muy cansado.
¡Si pudieras gustar en un sorbo la vida entera!

Zer dodan eztakit, baña gexo nago:
gorputza aul daukot, gogua ariago.
Lausoz lurra dakust.
Naya mee daruat:
ardatz-antzo yabilt, lasai, arat-onat.

Etzunik banago, daurkit atsegiña...
Pozik eztot gura, eztot maite-miña.
Enagixu laztan, ezta be mosutu,
atzera mosurik ezin daiket bildu.
Neketu eznadin eztagit negarrik...
Eguzki galdatan, eztot nai-ixan deusik.
Luaren dei-leunai sarratu begijak,
Ederrak diran arren urrundu lilijak.

Zer dodan eztakit, baña gexo nago:
gorputza aul daukot, gogua ariago.
Arratsari nago..., itxas-urdiñari,
lanari el-ezin, soilik ametsari.

No se lo que sufro, pero estoy enfermo:
tengo muy débil el cuerpo, pero mucho más el alma.
Vislumbro la tierra através de una neblina.
                                        Mi voluntad
está muy enflaquecida y se mueve a todos los rumbos
como una lanzadera suelta.

Cuando estoy tumbado, parece encuentro la felicidad serena..
No ansío placer alguno, no amo ningún dolor.
No quiero besos, no quiero ternuras
que no podría retornarlas en cambio.
Por no cansarme, no quiero derramar mi llanto.
Anhelo esfumarme en los rayos solares.
A las voces suaves del sueño, cierro los ojos.
Aunque sean muy bellas, alejar de mi lado las rosas.




No se lo que sufro, pero estoy enfermo:
tengo muy débil el cuerpo, pero mucho más el alma.
Por eso, amo el atardecer..., al azul de los mares,
no puedo sujetarme al trabajo y tan sólo me agrada el soñar.

## Neguko gaba

*Errenteria'tar Gorgoni'ri bijotzez.*

Ara edur-zuriz, zuri, Oiz gorenak,
eta ixotzak jorik geldi lats gurenak.
Ibarretan edur zurijak
dagijez ixara barrijak.

Odeizko yantzijan dator negu latza:
betiko gorubaz edurren matatza
eunduten diñardu ortzijan.
Ameslari lerrak mendijan...

Orri-ikararik ez lertzun ta urkijetan,
Garrak dirdir-begi suteko tresnetan.
¡Axe otzoi, ua basora,
ipuin zarrak betorz sutera!

Pertza albuan, dantzan, Muru'ko sorgiña,
egazka Anboto'ko andere ziztriña.
¡Lua betor umeen begira,
amets-zitala, ua mendira!

Gorbeyan murruka axe eta edurra:
¡Oi yakun samurra, suteko murmurra!
Artega su-motots bixijak,
yantzan mamu gorriz yantzijak.

Ipiñi egurrik naiko sukaldian;
sugarrak dirdira dagijan artian
eztago edurren bildurrik.
Ez ixan otzen ardurarik...

## Noche de invierno

Mira, blancas de blanca nieve, las cumbres del Oiz
y sujetos por la helada, quietos, muertos, los profundos ríos.
En los valles las blanquísimas nieves
van tejiendo nuevas sábanas.

Envuelto en un vestido de nubes llega el invierno áspero;
con su rueca de siempre hila en los cielos
los copos de nieve.
Los pinos sueñan en las montañas.

Hoja alguna no se mueve en los álamos y abedules.
Brille, pues, la llama en la vajilla del hogar.
¡Oh, viento helado, huye al monte,
las viejas leyendas vengan a la cocina!

Enderredor del puchero baila la bruja de Muru-mendi;
vuela por las cumbres la Señora de Amboto.
¡Ven, ¡oh, sueño! a los párpados de los niños,
y tú, inquietador sueño, huye al bosque!

En el Gorbea luchan mugiendo el viento y la nieve;
¡Qué dulce nos es el murmullo del hogar!
Inquietos se mueven los penachos rojos del fuego,
y bailan como enanos vestidos de carmín.

Poned leña abundante en la cocina.
mientras la llama brille, no haya miedo
de las nieves.
No tengais miedo del frío.

Egun obiaren deya da neguba;
itxaro barik ez makurtu buruba.
Gau begitan dator eguna,
zoritxar altzuan, zoruna.

Asaben sutian piztu urrezko garra,
ta goguan, bixitz-arau dan indarra.
Aberrijan txadon donia
AREITZ-suba dagon sutia.

Or, negu latzezko gau-ordu luzeetan
aintzezko itz-sakonak, idazti zarretan,
daurkiz gogo ameslarijak.
Asaben eredu garbijak...

Poztu, ta bijotzak ez euki urduri;
gaste ule baltz gara, ez zar ule zuri.
Bijarkua itxi etorrijari,
eta yantzan ta abesten ari.

Bixitza onetan ametsa da oro,
zadorrik, arren, ez egixu nai idoro.
Larrosak tori arantzetan,
alde-ona billau gauzetan...

Ara edur zuriz, zuri, Oiz gorenak,
eta ixotzak jorik geldi lats gurenak.
Itxarorik ez urrun jaurti,
billau bixitza onen neurri.

Piztu su-gorrija soña berotzeko,
ta zartzaro-leunak edurrez beteko
dauskubenerako buruba,
¡piztu, arren, maitasunsuba!

El invierno es la promesa de otros días mejores;
no inclinéis al suelo la frente sin esperanza alguna.
En los ojos de la noche llega el día,
en el seno de la desgracia viene la felicidad.

Encended, avivad en el hogar paterno la llama de oro,
y en el alma, la fuerza que es norma de la vida.
El hogar donde arde el fuego del ROBLE
es un templo de la patria.

Ahí, en las largas noches invernales
las almas que saben soñar, encuentran en viejos
libros, profundas palabras de gloria.
Los ejemplos claros de los antepasados.

Alégrese el corazón, y no temed inquietudes;
somos jóvenes de negro cabello, y no viejos encanecidos.
Lo del mañana dejárselo al porvenir,
y comenzad con cantares y danzas.

En esta vida todo se resuelve en sueño y mentira.
No quieras inquirir el misterio.
Recoge las rosas de los zarzales,
en todas las cosas busca el bien.

Mira, blancas de blanca nieve, las cumbres del Oiz,
y sujetos por la helada, quietos, muertos, los profundos ríos.
No arrojes de tí la esperanza.
Busca el ritmo de la vida.

Encended el fuego para calentar el cuerpo,
y para cuando la dulce vejez nos cubra la cabeza
de blanquísima nieve,
¡encended, por piedad, el fuego del amor!

# Gurutze-aldera

Gurutz-ondora eldu gurarik
bidia billa nabil neketan.
Zidor gustijak arantzez dagoz,
sartuten yataz oñetan.

Nekezko bide esturik baño
orra eltzeko, Jauna, eztago?
Elorri punten bildurrez beti
gurutzatik at bai-nago.

Odolez daukot neure gorputza,
urratu nabe sasi zorrotzak.
Baña enabe orra zuzentzen
nekezko bide mingotsak.

–Ezin Neugana eldu al-zara
samin arteko zidor aldetik?
Arantza orreik mintzen bazabez
¡¡zatorz maitasun-bidetik!!

# Hacia la cruz

Ansiando llegar hacia la cruz, discurro
buscando un sendero.
Todos los caminos estan cubiertos de
espinas y me punzan los pies doloridos.

Señor, ¿no existen más que caminos de dolor para
llegar hasta la cruz?
Con temores de espinas siempre ando
apartado de tu lado.

Ensangrentado llevo mi cuerpo, y me han
desgarrado los espinales.
Pero he aquí que jamás llego hasta tu cruz
por estos senderos del dolor.

-No puedes acercarte hasta Mi por la
senda de las angustias?
Si pues las espinas te infunden miedo,
¡Ven, por los senderos del amor!



# Arotzak

*Urigüen dar Joseba Mirena'ri.*

Arotzak lan-dagije, zar eta gastiak:
oya batak badagi, ilkutxa bestiak.

– Arren, oya bukatu nasai lo-dagidan
bijotzan poza yatan maitiaz batera.
Begijak apal-itxi luaro aldijan
eta irrija datorke espanen ganera.
Ezkon-barrijen oya, bai-da donetsija,
bertan zorunak dagi maitasun abija.

Arotzak lan-dagije, zar eta gastiak:
oya batak badagi, ilkutxa bestiak.

– Geldiro ilkutxa egin. Eder yat bizitza.
Itzalentzat bakarrik ixaten da ilkutxa.
Or ezin sartu naike maitasun irritza,
eta gastaruaren lorazko gorputza.
Zerraldua ituna da itxaropen barik,
bertan ezta sortuten ametsen lorarik.

Arotzak lan-dagije, zar eta gastiak:
oya batak badagi, ilkutxa bestiak.

Ixilik gaba dator liluraz bilduta:
Ene arotz gastia, ekin biarrari.
Ain maite dodan oya itxi amaituta.

# Los dos carpinteros

*A José María de Urigüen.*

Los dos carpinteros, el joven y el viejo, trabajan sin cesar;
mientras el uno labra un lecho, el otro enclava un ataud.

—Por favor, termina de labrar el lecho para que duerma tranquilo
con la adorada que es la alegría de mi corazón.
Cerraremos los ojos dulcemente a la hora del ensueño y
divinas sonrisas han de florecer sobre nuestros labios.
El lecho de los recién casados está bendecido por el amor,
la felicidad anida en su descanso.

Los dos carpinteros, el joven y el viejo, trabajan sin cesar;
mientras el uno labra un lecho, el otro enclava un ataud.

—Trabaja lentamente en enclavar el ataud. ¡Me es tan hermosa la
vida! Las sombras tan sólo aman la tumba. Yo no podría encerrar
en su seno estas ansias inmortales de amor ni esta juventud que
lleva en su cuerpo un perfume de rosas.
Es muy triste el ataud si un rayo de esperanza. Las flores
del ensueño no brotan en su seno.

Los dos carpinteros, el joven y el viejo, trabajan sin cesar;
mientras el uno labra un lecho, el otro enclava un ataud.

La noche desciende callada envuelto en misterios. ¡Oh, mi joven
carpintero, no ceses de trabajar! Deja terminada la obra
que tanto ama mi corazón.

Arotz zar orrek barriz alde-egin lanari.
Zeure soñak deskatu gauko atsedena.
Goitik ixarrez dator ordurik leunena.

Arotzak lan-dagije, zar eta gastiak:
oya batak badagi, ilkutxa bestiak.
Egunak argi-dagi mendixka ganian:
Arotz agure orrek amaitu dau lana.
Zerraldo baltza daurkit etxeko atian...
Gastia barriz luak uatu dau dana.
Erdi egiñak datza oe ain kutuna.
Orain zertako dogu geure maitasuna?



En cambio tu, ¡oh, mi viejo carpintero!, marcha a descansar. Tu cuerpo pide el descanso nocturno. Mira la noche que baja entre estrellas.

Los dos carpinteros, el joven y el viejo, trabajan sin cesar; mientras el uno labra un lecho, el otro enclava un ataud.

El alba sonríe en la montaña. Y el viejo carpintero ha terminado su largo trabajo. Encuentro en la puerta de mi hogar un ataud negro...
El joven en cambio ha sido dominado por el sueño y abandonó la labor. A medio hacer contemplo el lecho que tanto añoré.
¿Para qué anhelamos ahora nuestro pobre amor?



# Itauna

Maitatzen bazaitut, itaundu dautsozu
leyuan klisk-dagin illargi-izpijari.
Larrosa zuriko txindor kantubari
itza artu ezinik gaba igaro dozu.

Axiari itaundu dautsozu legunki:
berak baña jolas dagi zeure ulian.
Eta dakije ezer ixarren unian?
Mosu dagitzube gustijak kutunki...

Itaundu dautsozu zeru garbijari,
itxasoko uiñai ta ixadi orori.
Maitasun orretzaz baña, maite ori,
¡ez dautsozu itaundu zeure bijotzari!



# La pregunta

Al rayo de la luna que resbala en los cristales
de tu ventana, has preguntado si te amaba.
Has pasado la noche anhelando interpretar
la canción del ruiseñor que cantaba sobre
un blanco rosal.

Has preguntado suavemente al aura, pero el viento
juega en tu blonda cabellera. ¿Sabrán de este amor
las estrellas del cielo? Dulcemente te besan
con su luz.

Has preguntado al cielo sereno, a las olas del mar,
a la creación entera.
Pero, ¡oh, mi adorada, jamás interrogaste sobre este
amor, a tu propio corazón!

# Erantzuna

Illargi-mosu dabil edurtze zurijan:
urbil geure soin oneik maitasun zorijan,
itzal miak dagijez bide bakartijan.

Otzak ixoztu daroz maite-itzak abuan
eta dardar dixuri barriro kolkuan,
maitasun ondar oneik gorderik goguan.

—Maitatzen ete nozu, neskatil liraña?
lei gurenez ditauntzet: odei baltzez baña
ilun iluntzen yako bekoki bikaña.

Itz leunez poztuteko neure gotilluna
begijetan neuskijo billau erantzuna.
Erantzun orrek dakar minduben zoruna.

Ixil berak didatzi edurtze ganian:
goibelez ilargija odeyen artian...
Nok digarke erantzunoi gaberdi baltzean?



# La respuesta

El beso de la luna resbala en la blancura de la nieve.
Nuestros cuerpos muy juntos en un ensueño de amor,
proyectan largas sombras en la senda silenciosa.

El frío congela en los labios las palabras de amor
y temblorosas caen de nuevo dentro del alma
ocultando los secretos de los corazones.

—Me amas, tal vez, oh, linda joven?—
la interrogo con ansias divinas, pero las nubes oscuras
de la noche ocultan su frente virginal.

Deseando alegrar mi corazón entristecido con su palabra
quisiera encontrar la respuesta en sus ojos. Esa
respuesta sería la dicha de mi corazón.

Ella escribe sobre la nieve, silenciosamente.
La luna se ha ocultado entre las oscuras nubes...
¿Quién podrá leer esa respuesta en la noche tenebrosa?



## Miren Neskutza'ren Baselexa

Gogo-itunak dakijen menditxu ganian
Neskutz-samurra datza gexuai begira.
Alayak, andik urrun badabiltz ludijan
Baña begi mindubak ara eltzen dira.

Artzañak otsein yakoz, argontzi ixarrak.
Goxa jeiki ezkero an dabil kedatza,
Usaintzen dabe leunki ormako bedarrak.
Uso baten antzean baselexoi datza.

Orra duaz auldubak otoi-egitera,
baita gexo-eztenak mindu dituzanak.
Gustijak ditxaroe maitasun-arrera.
Ur ori maite dabe gixonen espanak.

Orra gastien eta zarren ibildeunak;
Batzubek dakartzubez arantzezko-oroyak,
eta bestiak barriz itxaropen-leunak.
Entzun ume- ametsak ta zarren otoyak.

Orra duaz gastiak lorazko bidetik
onetsi dagixuzan maitasun-mosubak.
Zeru goiko argija Zeure txadonetik
Ikusi gura leuke atsotxu mindubak.

# La ermita de la Virgen María

Sobre la cumbre montañera que conocen las almas atribuladas, se levanta la tierna Virgen que espera a los enfermos.
Las alegrías ríen muy lejos de aquel lugar, pero los ojos llorosos llegan siempre allí.

Le sirven de Ministros los pastores, de lámparas las estrellas.
Cuando brilla el alba por allí vuelan los perfumes.
Le inciensan suavemente las hierbecillas de las paredes.
Como una paloma se admira la ermita de la Virgen.

Ahí llegan los dolientes para derramar sus plegarias, y los pobrecitos que fueron heridos por la enfermedad.
Todos esperan una caricia de amor. Todos los labios quieren apagar su sed en esa agua divina.

Ahí llegan procesiones de niños y ancianos. Los unos te traen recuerdos dolorosos, los otros en cambio sus dulces esperanzas.
Escucha, por piedad, los ensueños de los niños y las oraciones de los viejos.

Ahí llegan los jóvenes por caminos floridos para que Tú bendigas los besos del amor. Desde tu templo ansía admirar los cielos abiertos de la viejecita atribulada.

Gogoen batzun baña ezin eldu dira
eta negar artetik gedar dagitzube.
Oinditik jeiki zaite gabeko argira
Ta gexo oi bidera urten eijozube.

Erririk erri zuaz mindubak poztuten:
Zeu onduan zarala, erijotz ordubak
Itun diran bijotzak eztauz bildurtuten.
Begijak itxi, arren, tolestu eskubak.

Mendiko Neskutz ori, zeure magalpera
Negar gustijak duaz, oñaze gustijak.
Baña zuk goi-aldetik Erregin antzera.
Aurreratuten dozuz geure lei-larrijak.

Ortik asetzen dozu labalde legorra,
Baita euri eskean daguan andana.
Zeuganuntz dator egaz lugin oron lorra
Eta odeyak datorz, busti da oyana.

Ortik ikusten dozu ixurri zakarra
Seintxubak amakandik aldendu gurarik.
Euren ganera baña bator zeure ezkarra
Eta lurran eztago ailako lorarik.

Gaba datorrenian mendijen ganera
Zeure kanpak dalayez bijotz samindubak.
Txerrenak pozik duaz oben egitera
Baña zainduten gabez zeure aingerubak.

Pero, he aquí, que no pueden llegar algunas almas y te imploran desde el seno sus dolores. Levántate de tu altar a la luz de la noche y sal al camino a recibir a esos pobres enfermos.

Ve de pueblo en pueblo a alegrar a los entristecidos: cuando estás a su lado no se amedrentan los corazones acongojados por el beso de la muerte. ¡Ciérrale, por piedad, los ojos, pliégales las manos!

¡Oh, Virgen de la Montaña! a tu amparo vuelan todos los llantos, todos los dolores. Pero Tú desde ese trono de reina sabes prevenir nuestros dolores, nuestras horas de angustia.

Desde ahí riegas la sequía de las llanuras y las cosechas, que están pidiendo la caricia del agua. Hacia Tí vuelan las tristezas del pobre labrador y al punto llegan las nubes, y el bosque se refresca.

Desde ahí ves la peste cruel que aparta de las madres a los niñitos. Pero al momento tu gracia se posa sobre sus frentes y en la tierra no se encuentran tan bellas flores.

Cuando la noche cae sobre las cumbres, tus campanas consuelan a los corazones doloridos. Los diablos corren a pecar pero nosotros dormimos tranquilos, pues, nos custodian tus ángeles.

Sóla en la cumbre de la montaña, la Virgen amada, muestra en sus brazos a su divino hijo. Por eso las madres y los niños entran alegres en ese templo de tu amor.

Bakarrik mendi-goyan, Neskutz maitatijak
Umetxu zerutarra dager eskubetan.
Origaitik ameak eta sein txikijak
Pozik sartuten dira baseleiz orretan.

Zenbat alatz dagixan soñak osaturik:
Itxubak or dakuste eguzki-diztira:
Garbijak or badagoz bakez zoraturik,
Negarrez ogendijak auzpeztuten dira.

Zenbat oroigai datzan errukiz lotyta.
Itxasontzi politak, jantzitxu zurijak.
Txauno-bidazti legez onaño elduta
Txindirik eztaukonak, damotzuz lilijak.

Miren'en basatxono mendijan jarrija.
Gotillunak dakije orrako zidorra.
Tolesgientzat zara maitasun abija,
Obendijentzat barriz babes-maitekorra.



Cuántos milagros hace curando los cuerpos. Los ciegos ven ahí la luz resplandeciente del sol. Si los puros están como entre dulzuras de paz, los pescadores se arrodillan llorando.

¡Cuántos recuerdos yacen prendidos! Lindos barquitos y vestidos de blancor. Quien llega hasta tu templo como remero de amor, si no tiene dinero para ofrecerte, te ofrece bellas flores.

¡Oh ermita de María! cimentada en la cumbre. Los corazones tristes saben el camino que conduce a tu puerta.
Eres un nido de amor para los inocentes. Eres un amparo celestial para los pecadores.

# Jadetsi-eziña

Zeure mosubak diran laztanak!
eztizko lorak yatzuz espanak.
Larrosa orrein orri ganetan
ibilli nai dot, loreil onetan.

Laztantzen dodaz sasi-lilijak,
eta matzaren urrezko orrijak.

Mitxiletatxu baten antzean
artega nabil latxin ganian.
Zeure larrosa politak baña
ezin laztandu, neska lirаña.

Eragozpenak banantzen gabez,
eta mosuba dil atsekabez...

Al ditubazan lora gaxuak
laztantzen ditu geure goguak:
¡Baña dil, leitzen daben lorarik
bere bixitzan jadetsi barik!



# Anhelo inlograble

¡Cuán divinos son tus besos!
Brotan en tus labios flores de dulzura inmensa.
Y mi alma anhela volar sobre las hojas de tus rosas
en esta primavera deliciosa.
Acaricio los zarzales en flor,
y las áureas hojas de los viñedos.
Como una mariposa encantada vuelo
inquieto sobre la paz de las praderas.
Pero no puedo acariciar tus hermosas flores,
¡oh, jovencita bella!
Nos separan raras incompresiones.
y el beso se muere de pena...
Siempre nuestra alma acaricia las flores
que puede alcanzar en su camino;
¡pero jamás besa la flor que es la única
ilusión de su vida!



# Mao gorrija

Maitasunaren ikurkorra zan
zure leyoko maoa,
ikusten neban goiz-iluntzetan
poztuten yatan gogua.

Igande goxe baten kantari
ebai zendun ma-egiñez
eskeini zeuntson gaste bateri
ikusi neban samiñez.

– Ederra baida mao gorrijau –
erantzun eutzun gastiak
betiko orduban alkartu ziran
zuben bijotz maitaliak.

Eskeini zeuntson mao ederra...
¡ene neskatil polita!
ta bazenkixun ernia zala
neure negarrez bustita.



# El rojo clavel

Era el símbolo de nuestro amor,
el clavel de tu ventana.
Cuando al amanecer y al atardecer lo veía
*mi corazón se llenaba de placer.*

Una mañanita dominguera, la cortaste, después
de besarla dulcemente.
La ofreciste a un joven amigo...
Y mi corazón se llenó de tristeza.

—¡Cuán bello es este clavel rojo!—
te contestó el joven.
Y entonces para siempre se unieron
vuestros amantes corazones.

Le ofreciste el hermoso clavel...
Y, ¡oh, mi linda jovencita!
y tu bien sabías que había
brotado el riego de mis lágrimas



# Abaua

Erladi-urdurija, neure gogamenok
espan gorrijoi dagoz: arin dabiltz orok.
Urduri dabiltz neure gogai-erletxubak
zeure loretan batzen lora-irin gurija,
¡Espan orrein lorakaz dagijen eztija!
Bijotzean bil-dodaz abau gozotsubak...
Maite gintzazanian
gordeten nendubazan bijotz barrenian.
Zeure ezetza ostera
mingoits itunez jausi yatan bijotzera.
Gozo biarra neukon barruko miñean,
eta mustau nenduban abau ederrena.
Baña zer txastau neban eztijan ordean?
¡Espan orrein lilijak ba euken edena!
¡Egiz neure bijotza
iratu yatan oro!
¡Maitasunan mingotsa
abau aren barruban bai neban idoro!

# El panal

Mis pensamientos son como un enjambre inquieto de
abejas: vuelan a tus labios; todos van ligeros hacia tí.
Inquietos vuelan mis pensamientos—abejas—a buscar en tus
labios el dulce pólen de las flores.
Con las rosas de tus labios hacen su dulcísima miel de amor,
y guardo en el corazón los divinos panales...
Dentro del corazón los guardaba mientras nos amábamos.
Pero al escuchar tu desvío, un amargor interno
cayó sobre mi alma.
¡Cuán falto de dulzuras estaba mi pobre corazón!
Y probé el panal de tus flores.
¿Pero qué es, lo que gusté en lugar de suavidades?
¡Oh, tus labios estaban envenenados, tus rosas llevaban ponzoña!
y mi corazón quedó malherido.
¡Tan sólo encontré el dolor del amor
dentro de ese divino panal!

## Gaste gexua

Mendi-ertzeko gastia arratsak dakar'geldiro:
udazken ori barnera sartuten yako ieunkiro.
Zugatzen orri zimelak lurrera datorz axian
eta ametsezko zerrija zabaltzen dabe bidian.
«Samiñez nator zeugana, maite zaitudan basua:
orbelen jauste mindubak diraust erijotz arua.
Abi utz orreik zeuriak, zeuria zarba zimela,
baña neure soin gaxua luzaro bixi daitela.
Gastia nazan ezkero oraindik eztot il-gura.
Bekoki onek dagerren maitasunezko lilura
ezin illundu dagike erijotzaren laztanak.
¡Ariñik duaz obira zerubak maite dauzanak!
Nik barriz nasai lo-dagit itxaruaren aspijan.
Itun dagozan bijotzak poztu egixuz ludijan
edo bixitzaz mindubai itzalez itxi begijak.
Ustege dagon batentzat eskei zugatzan, lokijak.
Mendiko magal ertzian daguan areitz zimela
aizkora kazka zorrotzaz lurrera jausi daitela,
baña iraun begi lerdentsu emaitz batezko zugatzak.
Bere orrijen itzalik ez bei apurtu ekatxak.
Mitxiletatxu sorgiñez eta larrosaz josita
orril-begijan baitago neure loragu polita.
Barne barnetik kantari, egun sentiko argira,
urrezko larratxorijak egaz dagije ortzira.
Enara batek bezela gastetasunak narua
eta eguak zabalik gorantza juat gogua.
¡Oraindik eztot il-gura, bixitzau yatan leguna!
Maite dau bijotz gaxuak ene aberri kutuna;

# El joven enfermo

El joven que vive junto al monte llega a la voz de la tarde;
con ternura insólita se le adentra la dulzura del Otoño.
Las hojas muertas de los árboles caen en el suelo al beso del viento,
y forman una alfombra de ensueño sobre el sendero.
«Dolorido llego hasta tu paz, ¡oh, bosque querido!
La caída de tus hojas me predice la hora de la muerte.
Tuyos son esos nidos vacíos, tuya la fronda ya marchita...
pero mi cuerpo enfermizo anhela vivir largos días.
Este encanto de amor que brilla en mi frente, jamás podrá ser
oscurecido por las caricias de la muerte.
¡Que siempre hayan de morir jóvenes, los predilectos del cielo!
Mas no, quiero descansar tranquilo a la sombra de la esperanza.
Alegra los corazones que lloran de tristeza,
o a los cansados de la vida, ciérrales los ojos piadosamente.
Cuelga en las ramas unas largas cuerdas para quienes no tienen
un anhelo futuro.
Que al golpe del hacha caiga en tierra, el árbol seco
de la lejana montaña, mas florezca ufano el árbol cargado de frutos.
Que jamás la tempestad desgarre la sombra de sus hojas.
Lleno de embrujadas mariposas y flores
mayo comienza a sonreir en mis jardines.
Cuando asoma el alba, vuelan en cielo azulado desde mi corazón
las alondras de oro de la juventud.
Como a una golondrina me lleva la mocedad,
y con las alas abiertas vuela el alma...
¡No quiero morir aún! ¡Cuán hermosa me es la vida!
El pobre corazón ama la patria bendita;
ama los amigos y los ancianos padres.

maitatzen ditu lagunak eta guraso tximurrak
baita zeu bere ene neskutza ta zeure begi samurrak.
Laguntza orrein eztija mustau nai dot il-artian.
Bildurrik gabe nor dua illobiko itzal bidian?
Atsegiñen mai alaira didar dagiste gustijak;
dastatu barik ostera itxiko dodaz jakijak?
Esku arteko usuilla edariz daukot beterik,
baña lorazko espanok eztodaz busti oraindik...
Jolas saratak neugana dakarz axetxu zolijak,
maitati bere atiak zabaltzen daustaz ludijak.
Mosuba erdi egiñik itxi biarra, bai ituna!
Bijarkuak beti dakar geure zalian zoruna.
Oraindik bixi gura dot, ludija yatan ederra.
¡Itunak poztu egiten bua arin gexo ankerra!
Negarrak ondo dirudi aguren begi minduban,
baña mosuba ederren maite diranen abuan.
Zarrak il beitez, oroyak-arren eztogu ayolik,
itxaropenak galtziak eztauko barriz neurririk.
Negubai otzak yagokez, udabarrijai lilijak.
Obijan soilik apurtu larrosa bageko ontzijak».
Olan iñardun gastiak orbel betezko bidian;
azken orrija dardarka lurreratu zan axian...
Baso aldetik betiko juan zan mutil gexua
ta itxaro illaren antzean itun lutu zan basua.
Negarrak ez eben lotu gexo ankerran zaurija
ta lorak, arren, betiko apurtu zan lorontzija.
Barriz eldu zan mendira udabarrijan laztana
eta lilijen usañak alaitu eban oyana,
Baña ostroen dardarak eta txorijen txijuak
Iñor ez eben idoro alai egiten basuak.

Y no te puede olvidar a tí, ¡oh, joven querida! ni tus divinos ojos.
Antes de morir quisiera gustar toda esa miel de amistades.
¿Cómo podré yo sólo, caminar por la oscura senda de la tumba?
He aquí que todos me convidan al espléndido banquete de la vida.
¿Dejaré sin apenas probarlos, los manjares más sabrosos?
Hasta los bordes está la copa que llevo entre manos,
mis dulces labios quedan sin embargo sin probar una gota.
El viento suave me trae un rumor de bailes
y la creación me abre sus puertas encantadas.
¡Qué triste es dejar a medio hacer el beso!
¡Oh, cruel enfermedad, corre a consolar a los tristes!
El llanto dicen bien en los ojos de los ancianos doloridos,
pero el beso es lo más agradable en los labios de los amantes.
Muéranse los viejos, pues nada importan los recuerdos,
pero el perder las esperanzas no tiene medida alguna.
Al invierno dicen bien los fríos, a la primavera las rosas.
Romped tan sólo en la tumba los búcaros que no llevan flores».
Así caminaba el joven en la senda de hojas muertas;
la última hoja temblorosa quedó en el aire.
Y para siempre marchó del bosque el joven enfermo.
Como una esperanza muerta quedó la montaña.
El llanto no fué parte para retener a la enfermedad cruel
y a pesar de las rosas se rompió el búcaro.
De nuevo llegó la primavera con sus caricias al bosque
y los perfumes de las flores lo inundaron todo.
Pero los murmullos de las hojas y los cantos de las aves,
no encontraron compañía alguna en la soledad del monte.

# Iluntzeko-ixarra

Gaste zintzo batek itun so-dagijo
ortzi urdiñeko ixar argijari.
Ixarrak, minduben atsegin dan izpiz
ma-dagijo mutil aren samiñari.

—Neure maite ederran malkua ete az?
I baxen samurra dok aren negarra.
Bere begijak so-egijelakuan
ain leunkiro mosu dagistak, ixarra?—

Eta zintzo ituna ixar ederrari
pozge so-egiten eguan unian,
neska leunak beste maitale bateri
alai ma-egijon bekoki ganian...



# La estrella vespertina

Un joven entristecido, eleva sus ojos hacia la estrella vespertina que brilla en el cielo azul. La estrella, con el resplandor que es consuelo para los tristes, besa suavemente el dolor del joven.

—Eres tal vez la lágrima de mi amada?
Más tierna que tu brillo es su llanto.
Tal vez porque te miran sus ojos, me besas tan dulcemente,
¡oh, bello astro del atardecer!—

Y mientras el fiel mozo mira tristemente a la hermosa luz de la estrella, la linda joven a otro amante con ternura besa sobre la frente.

## Gabeko-irrintzija

Gau-argitsuban bakarrik nago leyo idigijan;
ibai garbijan ixilik dabil iretargija.
Izpi-zurbillak dizdiz dagije baso erdijan.
Illargi orrek eztau itxartu artzain-zolija.

Mendi baltzaren goyetan, muga bako bakiak
zaintzen dau zeru eta lurraren maitasun-lua,
Gaba urrezko koroyaz dabil. Lora legunak
Ameslari, goi-gora digorte usain-goxua.

Gabeko gentzan gorpuzki oneik loratu dira...
Jainko diztira oro da... Baso-ziar emaro
Menditik yatort leunkiro abots baten intzira.
Dardarka zeru zabalan galtzen da naro-naro.

¡Baso ixoztuban estalduta agon maitale orrek!
Ezeik abestu, ba abes orretan dagerk bijotza.
Eure barneko keskak yagerzak irrintzi orrek,
ixildu egik samin latzezko maitasun-otsa.

¡Oi!, bijozkada leuna darijost eure irrintzijak.
Eure samiñaz batera dabesk neure samiña.
Bijotz orotan bardiñak dozak maitasun nayak,
abesti orok yagertek geure keska bardiña.

Irrintzi leuna galdu dok gauko zeru garbijan.
Eta ire samin orrek tolestu yozak eguak.
Gau oroz, baña, dardarka bere leyo idigijan
negar zotinka iraungo bai-yok neure goguak.

# El irrintzi nocturno

En la noche transparente estoy solo en mi ventana abierta,
la luna patina silenciosa sobre la limpidez del agua.
Los pálidos rayos resbalan en la frondosidad del bosque.
La luna callada no fué parte para despertar al pastor del monte.

En las cumbres de la montaña oscura, la paz sin límite alguno
guarda el sueño amoroso del cielo y la tierra.
La noche camina con corona de estrellas. Las flores divinas
en un ensueño, envían al cielo azul sus perfumes.

En la paz nocturna han florecido mis sentidos...
Todo semeja un resplandor de Dios. Y a través del monte, desde la
selva me llega dulcemente el suspiro de una voz. Un irrintzi.
Lentamente en el azul del cielo va perdiéndose tembloroso.

¡Oh tú, amante incógnito, que te ocultas en el bosque cubierto de
rocío!
No cantes, que tu canción lleva al exterior tu alma.
Tu irrintzi manifiesta las ansias del corazón.
Calla tu voz que trae recuerdos de amor y de pena.

¡Oh!, ese clamor me infunde una ternura insólita.
Tu dolor canta juntamente el mío.
Los dolores son siempre iguales en todos los corazones.
la canción manifiesta siempre los mismos anhelos, las mismas penas.

Tu irrintzi se perdió en la limpidez del cielo azulado.
y tu dolor ha plegado sus alas silenciosamente.
Pero durante toda la noche en su ventana abierta,
mi alma, mi pobre alma, permanecerá llorando de pena y de
angustia.

# Iturri-negarra

Ur gardenari begira
iturri-ertzan lilija:
ur altsuan lili aren irudija.

Maitasun-ego miakaz
axiak ba deragijo
maite daun urari ma-leunki dagijo.

Iturri leuna ostera
negarrez axiak daro.
Eta urretxindorrak urari emaro:

«Zegaitik negar yarijo?
Abar orlegi ganian
abeskide naukok oroldi bidian».

–Neure altzuan maitia,
euki-ta galdu ezkero
zelan negarrik ez dagiket maitero?–



# El llanto de la fuente

Mirando a la clara corriente
está la rosa junto al manantial.
En el seno del agua se refleja su imagen...

Si el viento, amorosamente la conmueve
con el beso de sus alas,
la flor besa también al agua transparente.

Pero el agua cristalina
sigue el curso de su cauce, con el viento.
Y marcha sollozando. Mas el ruiseñor le dice con cariño:

«¿Por qué suspiras de ese modo?
Sobre la verde rama seré tu compañero
de canciones, en esos senderos musgosos».

—¡Oh, cómo quieres que no suspire,
si habiendo tenido en mi seno la imagen de mi
amada, la pierdo para siempre!—

## Maitale kutuna

Iñoiz ikusi bako maitale kutuna
neure opa samurrok laztanduten dabe.
Begi gelgarriz dargist bijotzeko iluna,
eta bere larrosak usainduten nabe.

Zerutar egak ditu maitasun zaliak;
lurrera baxen sarri so-dagi ortzira.
Bere leuntasun ziar mosu sutsubenak
espan ganian, otoi bijurtuten dira.

Garbitasun usaña txakijan dixuri,
eta lo-dagonian ametsezko irrijak
aboko larrosetan dagerkoz urduri.
Aiztatzat alai dartu zelaiko lilijak.

Neskatil ori nor dan ez dazau bijotzak;
¡baña bera dan ona, bera dan liraña!
Begi oneik ez arren, bai-dakus ametsak.
Erean dazaukijot bekoki bikaña.

Sarri billauko neban bixitza bidian
ta edertzat aitortu beraren gorputza,
nok baña dasayoke begijen aurrian:
—Maite audana, ete az, neure neskutza?

# La enamorada predilecta

A la enamorada predilecta que nunca contemplaron mis ojos, acarician mis ansias de ternura. Con su mirada angelical ilumina la oscuridad que inunda mi corazón y sus rosales en flor me envuelven en perfumes.

La vehemencia de su amor posee alas celestiales; más veces que a la tierra vuelan sus ojos hacia el cielo azul. Los besos encendidos del fogoso amor se transforman en divinas plegarias sobre nuestros labios, al acercarse a su ternura ideal.

En su casta alcoba derrama esencias de pureza, y cuando el sueño cierra sus ojos inquietos, ensueños de amor florecen en sus rosados labios. El lirio de los prados la reconoce por hermana suya.

El corazón ignora el nombre de esa doncella. ¡Pero cuán buena es ella! ¡Cuán encantadora! Aunque mis ojos no la vean, la contemplo en mis ensueños. Su frente noble la pudiera reconocer en la modestia de sus encantos.

Con frecuencia la habré encontrado en mi senda y alabé la belleza ideal de su cuerpo. ¿Pero quién es el osado que se atreva a decirla ante sus mismos ojos. Eres tú, tal vez, la virgen predilecta que yo añoré?

Mi amor confía en Dios, pues Él válese de las brisas, durante la primavera, para hermanar las flores todas de los campos. Él entrelazará los hilos del amor.

Maitasun onek Goiko Jaunagan ditxaro,
berak axian bidez lilitxu gustijak
udabarri aldijan dalkartuz emaro.
Berak lotuko ditu maitasun lokijak.

Indar ixilkor batek batzen dauz goguak;
itzak loitzen ditubez maitasun gurenak.
Barre alayak ezik, barruko malkuak,
zale oneintzat dira antzikur gardenak.

Maitaliak ixanik alkartuko gara.
Jolas aldijan ezik otoyen orduban,
eguzkira ezpada, gabeko illazkara:
noiz'ak itxi Jainkuan izpizko eskuban.

Aldi alaitsu ori jadetsi artian
neure ezkongai bailiran neskatil danari
begiratzen dautsiet dagidan bidian.
Neska polit bakotxan zakust ameslari.

Bestiak zeure ederra goratuten dabe,
eurentzat gelgarrijak soin orren pitxijak.
Baña zeure zalian indartuten nabe
begi polit samurren leuntasun izpijak.

Zerutarrak baitira geure maitasunak,
eta leikide batek eztauz lausotuko.
Oraindik eztauz loitu gurari lixunak
eta gorputz irritsak eztauz banatuko.

Ikus eziña zara ezkongai neskutza!
baña, arren, entzun neure maitasunan naya:
Edurra baxen garbi irauki gorputza,
ixan zaite zitoriz gotzon baten gaya.

Una fuerza misteriosa une las almas gemelas. Las palabras son nubecillas que empañan la transparencia de los amores castos. Si no las alegres sonrisas, serán las lágrimas el espejo límpido donde se reflejen nuestras ansias.

Si somos fieles al amor llegará el tiempo de abrazarnos; si no a los rayos esplendentes del sol, a la pálida luz de la luna, si no al recrearnos, al orar por lo menos. La hora abandonémosla en las manos resplandecientes de Dios.

Mientras llegue ese momento tan anhelado, a todas las jóvenes miro en mi camino, como si fueran mis futuras prometidas. En cada doncellita hermosa te vislumbro rodeada de un nimbo de ensueño.

Tus otros admiradores alaban la hermosura de tus sentidos. Para ellos son dignas de encomio las bellezas de tu cuerpo. Pero al contemplar los rayos fúlgidos de tus inocentes ojos, brota en mis labios la alabanza portadora de mi deseo ardiente.

Nuestros amores son hijos del cielo y nunca un celoso de sus encantos ha de empañarlos. Todavía no los ha enturbiado el deseo menos puro, ni las ansias desmedidas del cuerpo las han de truncar.

¡Oh, virgen prometida!, eres invisible a mis ojos, pero escucha lo que mi amor anhela. Más pura que la blanca nieve de las serranías conserva tu cuerpo. Ansío seas un lirio digno de ser besado por un ángel.

¡Oh, mi purísima doncella!, sé siempre tierna como la dulce madre que adoro, y pura como la hija que mis anhelos añoran. Será, entonces, la dicha dueña de mi corazón.

Ixan zaite, ¡oi neure neskatil argija!
maitatzen dodan amatxu baxen leguna,
leituten dodan alaba baxen garbija.
Ori litzake neure gogoko zoruna.

Samurtasuna landu gogo orren altzuan,
urrumarako zara ba usoen antzera.
Ondo zaindu zaidazan oñaze orduban
olderik naiko dauko bijotzak ostera.

Espan orreintzat daukoz mosu samurrenak,
samin orreintzat barriz, maitasun eztija.
Eta txori politen abesti leunenak
zeugana eldu daiten luaro gurija.

¡Zeu maitatzeko nazan bijotz samurduna!
siaska ertzan datzan amatxu lakua.
¡Gorde zaidazan, barriz, jayo nintzan luna!
Euzko seme lerdena, bildur gabekua...

Zeugan pentzaten nabil Jaunaren bidian,
eta lokatz artian egaz dagit azkaŕ.
Andra baten oroya naiko da lurrean
garbi iraun dagiguntzant etsai orok ziar.

¡Oi, neure bijotzeko ezkongai gardena!
beti, arren, aditu maitati ortzira.
Zeugan mosuba baxen kutun dot arrena:
¡Andrak ederren dira zerurantz begira!

Vea la dulzura en tu alma angelical, pues, como paloma, naciste para arrullarme. Cuando te cerquen los dolores mi corazón sabrá defenderte con el ímpetu fogoso de su cariño.

Para tus labios, guardo, oculta en mi pecho, la dulzura de los besos más tiernos; para tus penas, la miel de los amores. Poseo los cantos más melodiosos de las aves para impregnar tus párpados en la paz del sueño.

Para amarte tengo un corazón rebosante de ternura. Como la tierna madre que vela, sentada, junto a la cuna de su hijo. Pero nací cual león para defenderte de toda asechanza. Hijo de la raza vasca que jamás tembló ante el peligro...

Pensando en tí, camino por la senda que Dios me señaló y vuelo, con alas de pureza, sobre los lodazales de la vida. El recuerdo de una mujer es suficiente en este valle cenagoso para que nos conservemos siempre puros...

¡Oh, mi gentil prometida, predilecta de mi corazón! Eleva tus ojos con dulzura hacia el diáfano cielo. ¡En tí prefiero la oración al beso! Las mujeres son más bellas cuando miran al cielo.



## Ituna

Maite oi!, agur, ilda betiko
geure maitasun kutuna.
Bijotz orretan aspaldiz dauko
bere obi oso illuna.

Maitetasun au udabarrijan
irrika sortu genduban.
Nork dasaguken negu aldian
ipingo gendula ilkutxan?

Ametsa dana ixan ete zan?
¡Oi, amets egin dabena
estaldutia, goguarentzat
samintasunik latzena!

Leyo idigitik ilargijari
so-dagijot gau baltzean.
Negarrez nago odoyai adi
gabaro gustiz leunean.

Zeuk zelan barriz abes-dagixu
gabeko aldi larrijan?
Abesti otsa bijotzak dantzu
zeure itzalezko txakijan.

Neska sorgiña, gau baltzenean
bildurrik bere eztaukozu
geure maitasun azurrotz ori
bijotzean ba darozu...?

# Tristeza

Oh, mi dulce joven!, ha muerto para siempre
nuestro tierno amor!
En tu corazón ha tiempo que encuentro su tumba.

Este amor floreció a nuestros besos en la
primavera. ¿Quién nos hubiera dicho que al llegar
el invierno la habíamos de sepultar en un
ataúd?

¿Fué todo un sólo tal vez?
Para el alma es el dolor más agudo la
desaparición de una felicidad soñada...

En la noche oscura miro tristemente a la
luna desde mi ventana abierta.
Lloro mirando a las nubes en esta noche silenciosa.

¿Pero cómo cantas alegremente en esta hora inquieta?
Mi corazón escucha una canción divina
en la oscuridad de tu alcoba.

¡Oh, joven embrujada! en la noche más negra ¿no sientes
temor alguno, si llevas dentro de tu
pecho el cadáver de nuestro amor?



## Txakurtxuba

Goxeko galdatara
txakurrak etzunik.
Arri ganian datzaz
begijak itxirik.

Nasai-nasai dedate
bero lixunkoya.
Izpi-garbijak dargi
euren gorputz loya.

Noxean-bein gorantza
jaso dauz burubak.
Eulijak atzemon nai;
¡Txakurren alperrak!

Kanpora durten pozik
neure txakurtxubak.
Jolas-egin gura dau
toto txikertxubak.

Txakur zekenakana
eltzen da saltuka,
ayek baña artzen dabe
amorruz orruka.

# El perrito

Al sol de la mañana
yacen tumbados los perros.
Sobre las losas yacen
con los ojos cerrados.

Perezosos beben
el calor lujurioso.
El rayo purísimo resbala
sobre sus cuerpos sucios.

De vez en cuando levantan
hacia el cielo, sus cabezas.
Quieren coger las moscas;
¡oh perros perezosos!

En esto sale a la calle, alegre,
mi lindo perrito.
Quiere jugar con sus compañeros
el perro pequeñín.

Brincando se acerca
hacia los perros despreciables,
pero ellos le reciben
con sordos rumores.

Tente ate aurrian
*Oriño* txikijak,
gora jaso daruaz
begitxu argijak.

Zerubari adika
ume bat bezela,
ikuspena dirudi
betesten dabela.

Eta txakur politak
oso ameslari,
ausi egiten dautso
zeruko oztiñari.

Cuadrado en la puerta
*Oriño* el pequeño,
levanta hacia el cielo
sus ojos suaves.

Mirando al cielo
parece un niño,
que viera surcar el azul
una aparición.

Y el perro chiquitín
todo ensoñecedor,
ladra alegremente
al azul del firmamento.

## Eskontza-eguna

Ortzargi-altzotik jatsi ete zintzan lurrera?
¡Ain garbi zenduzan yantzijak, ain argi begija!
Bidian ixuri zenduban lurrinkai gurija...
Lurra ikutu barik zoyazan gotzonen antzera.

Maitasun zaliak sortzen ziran zeure soera.
Gozartu zenduban bixitza gustiko zorija.
Egaz larrosara juan zan txirrita zurija,
maitasunak zabal-egin eban lora ganera.

Neskutz, bil-zenduban mosu baten, zeure bixitza.
Eta betikorra bailitzan barneko irritza
loratu yatzuzan begijak ludiko pozagaz.

Lora ezilkorrak, maitasunak, zeure bidean
zabaltzen ebazan, laster baña igartu zirean,
atzetik etorren erijotz-axian otzagaz.



# El día de la boda

Bajaste, tal vez, a la tierra, del seno de la aurora?
¡Tan blanca era tu vestidura, tan pura tu mirada!
Un suave perfume derramabas en tu camino...
Sin tocar apenas la tierra, marchabas como un angel.

A tu mirada renacían divinas ansias de amor.
Gozastes aquella mañana toda la felicidad de la vida.
La blanca mariposa voló sobre la rosa de oro,
voló sobre la flor que abrió sus pétalos al beso del amor.

Virgen, reconcentraste en un beso, toda la vida.
Y como si fuera inmortal la floración del alma,
tus ojos se iluminaron con la alegría de la tierra.

El amor iba derramando rosas inmortales sobre tu senda,
pero, ¡cuán pronto se marchitaron,
al beso frío de la muerte que caminaba tras de tí!

# Ludi-ameskoŕa

Soin onen sasi-pian negarrez bai'nago;
¡Zeure goi-eskaŕ barik bixitza yat latza!
Naigabe-itun azpijan zauriturik natza,
Neukon etxia, zarrez, erori dalako.

Lentxu maite ninduben munduko gustijak,
Samiñaren katiaz lotuta ikustiaz
negaŕ-gazija neugan itxi ta aldendubaz
«Lo-egik,–esan dauste,–zoritxar-azpijan».

Pozez beteta igazi nai-neban ludija,
atsekabiak baña lepu-ganen juaz,
«Mundu au ametsa,–esan daust,–zorakerija».

Geyegi atsekabez neu asetuteko
arantzaz josiriko amets ain gozuak.
¡Zeu, Jauna naiko, alai neu erabilteko!



# La vanidad del mundo

Bajo las espinas de mi carne, estoy sollozando;
¡Cúan amarga me es la vida sin tu gracia divina!
Aprisionado por el triste dolor, yazgo herido,
porque de puro vieja sucumbió la casa donde vivía.

Antes todas las cosas del mundo me amaban,
pero al verme sujeto a la cadena del dolor, dejando
en mi compañía el llanto tan sólo, huyeron, clamando:
«Descansa bajo la desgracia».

Quise caminar por el mundo lleno de alegría;
pero el dolor me golpeó sobre la espalda y me dijo:
«Este mundo es un sueño, todo es vanidad».

¡Oh, han sido demasiado para colmarme de amargura
los dulces sueños floridos entre espinales!
¡Tu eres mi Dios el único capaz de traerme alegre!

## Goguaren eresija

*Goitia'taŕ Martin zanari bere goguaren eresi au dopalsot.*

Jaunguak gogo batzuk zauriz joten ditu,
eta nekian euren gorputzak esitu.
Negar dagijen, arren, kentzen dautse dana,
eta kurtze gogorra da Bere laztana.
Itunik beti duaz bide bakartijan,
ostaz euren goguak zaurizko soñean.
Errukirik ostera eztagertse Jaunak,
eta geyago joten dauz bere gezijak.
Eztitu osatuten euren oin mindubak,
iñork ez dantsuz euren ayots samindubak.
Euren ortuko lorak dapurtuz ekatxak,
gerizik eztagije euraen zugatzak.
Gogorki kentzen dautsez diru ta lagunak,
laket-barik bai'daurkiz beti gau illunak.
Orok duste azturik Jaunak daukozala,
¡bijotz orren bixitza ain dager zimela!
Samiñez jausten dira arantza ganera,
eta orok ditxijez legenar antzera.
Ordu aretan baña, Urtzi'ren mosubak
osatuten dauz euren zauri odoltsubak,
Berak legortuten dauz nekezko negarrak;
malko orrekaz piztuten dauz ortziko ixarrak.
Amayeran matekoŕ Urtzi'ren irrijak
zabalduten dautsoez zeruko atiak.
¡Orok igez-eitian Urtzi maitasunak
pozez laztantzen ditu gogo ain itunak!

# El salmo del alma

El Señor suele herir algunas almas muy duramente,
y doma sus cuerpos bajo el dolor.
Aun cuando claman llorosas, les arranca todo,
y su caricia es la pesada cruz.
Caminan tristes por la senda solitaria,
y apenas soportan el alma en cuerpos tan magullados.
El Señor en cambio no les muestra piedad alguna,
y su flecha los va hiriendo sin cesar.
No cura sus pies doloridos y sangrientos,
ni persona alguna escucha sus gemidos tristísimos.
La tempestad arranca las flores de su jardín,
y sus árboles no proyectan sombra alguna.
Con mano férrea les quita los amigos y el dinero,
y la noche silenciosa los encuentra sin placer.
Todos creen que Dios los ha abandonado,
¡pues, tan marchita es la vida de esos corazones!
Sin fuerzas caen sobre las espinas,
y allí quedan como si fueran leprosos, nadie los mira.
Pero entonces los besos de Dios llegan a curar
las heridas ensangrentadas.
El seca las lágrimas dolorosas
y enciende los estrellas del cielo con su brillo.
Al fin la sonrisa divina del Señor
les entreabre las puertas del paraíso.
¡Al huir todos, el amor de Dios,
alegremente acaricia a las almas atribuladas!

# Mosuba

Abesti leunak loratzen ziran
espan ganeko gentzean.
Bijotz samurra bildu zeustazun
maitasunezko leyean.

Orain ixilik abesa dago,
eta zerurantz begira
dizdir begijan malkuak dagi,
maitasun baten diztira.

—¡Abes bigunen erregin ori!
alai abestu egixu.
Orain maitale garialako.
samiñez negar dagixu?—

Espan kutunak neureganatuz
mosuba damost amesti.
—Ta mosu onek, — samurki diraust,
ez dabes anei abesti?—



# El beso

Florecían en la paz de tus labios,
dulces canciones de amor.
Y me envolviste el corazón en un ensueño
de cariño.

Ahora la canción está silenciosa,
y mirando hacia el cielo
brilla una lágrima en tus pupilas,
una lágrima de amor.

–¡Oh, reina de divinas canciones!
Canta alegremente.
¿Porque ahora somos amantes
lloras con tristeza?–

Entonces acerca sus labios hacia mí,
y todo encantada me besa.
–Y este beso–me replica dulcemente–,
no canta mil canciones?–



# Lied

Ortzargi-mosuz txautu
neurtitzik politenak.
Euren izpi artian loratu daitezan
neure maite samurran ametsik leunenak.

Pitxi gelgarriz josi
industun dirdirtsuba.
Garo bikain ganian izpiz lotu daiten
aren maitasunezko malko laztantsuba.

Artixar malkoz busti
basotako lorea:
bere orri artian ostendu dagidan
neure neskutz lirañan ayer tolesgia.

Gabeko itzalez landu
berunezko illobija;
zerraldo orren altsuan esitu dagidan
¡maite nendubanaren maitasun aztija!



# Lied

Purificar con besos del alba
los versos más hermosos.
Entre sus resplandores ansío florezcan
los sueños más bellos de mi querida joven.

Engarzad con perlas maravillosas
un collar iridiscente.
Entre sus cuentas preciosas quisiera sujetar
la lágrima más hermosa de mi amor.

Con llantos de la estrella vespertina
mojar la flor de los montes.
Entre sus hojas anhelo esconder
la ira sin malicia de mi pequeña adorada.

Labrar con las sombras de la noche
un sepulcro de plomo.
Dentro de ese ataúd deseo encerrar para siempre
¡el amor embrujado de la que me amó con delirio!



# Bijotzean

Lorategiko edur zurijan
irarri zendun neure irudija.
Axia eldu ta egal otzez
autsitu eban gustija.

Larrosa baten orri ganian
idatzi zendun ixen maitia:
udea eldu eta eguzkijak
igaftu eban lorea.

Neure gorputza esku miakaz
marreztu zendun are ganian:
etorri ziran olatu urdiñak
atzindu eban unian.

Beti-betiko iraun dagijan
badakixu non sakon irarri?
¡Bijotz barruban, maite kutuna,
maitasun izkiz idatzi!



# En el corazón

Sobre la blanca nieve del jardín
imprimiste mi imagen.
Llegó el viento y con sus frías alas
todo lo borró.

Sobre las hojas de una rosa
escribiste mi nombre querido;
llegó el verano y los soles
marchitaron la flor.

Con mano fina dibujaste sobre la arena
la imagen de mi cuerpo.
Vinieron las olas azules del mar
y borráronla en un instante.

Para que perdure eternamente
¿sábes, ¡oh amada! dónde la debes de imprimir?
¡Con palabras de amor, escríbela,
dentro del corazón!



# Jaungoikotija

*Agirre'tar Joseba Andoni'ri.*

Nuan Goiko Aitaren erruki-altzora:
begijok begoz beera ta bijotza gora.
Neugan bakia zala at-billau nenduban,
zoruna baña soilik daukogu barruban.
¡Zeruko poza billa bijotz onen lorrak!
Gustijak nai nebazan lagun iraunkorrak
neu saltzalle nintzala Jaunan maitiari.
Zuur nintzayen griñai, goor eskar-otsari.

Ez zindudan maite nai, Zeu maitatu ixanik
ezin nebalako bil beste maitasunik.
Obena egun yatan, gaba illargi bixi;
argijan itxu nintzan, gaban begi-zoli.
¡Bana laket artian neban zeure miña!
Zeugaz bete ixateko nozu ba egiña...
Iñon atsedenik ez, urrun zeuregandik;
¡ez zintzan tokijetan Zeu billatu nairik!
Bijurtu zindudan ba ixadi aratza,
larretako bakian nasain lo negijan,
ta begijok ebiltzan goxaldeko izpijan.
¡Gustijak baña soilik ziran zeure urratza!
Zelan gabiltz ikusi ezin zaitugula
zeugana juateko argizko bidiak
gauza danak badira?

Udalen ta lorak.

# Divina

Llegue hasta el seno amoroso de mi Padre celestial:
los ojos miren hacia el suelo, el corazón hacia la altura.
Teniendo dentro de mí mismo la paz, la quise encontrar fuera,
pero la felicidad tan sólo florece en las almas.
¡Oh, trabajos por conseguir, esta alegría!
A todos quise amigos fidelísimos, cuando yo era traidor al amor
de mi Dios.
Estaba alerta a las pasiones, sordo a la voz de la gracia.



No quería amarte, porque amándote, mi Dios,
no podía dar cabida en mi corazón a otro amor.
El pecado me servía de claridad, la noche de clara luna;
en la luz era como un ciego, de ojo claro en la oscuridad.
¡Pero aun en medio de los placeres que ansias de Vos sentía!
Pues me hiciste Señor para descansar en tu remanso.
Lejos de Tí no podía encontrar descanso alguno;
Y te buscaba allí donde no puedes estar.
Entonces te convertí en la creación maravillosa;
dulcemente descansaba en la paz de las praderas
y mis miradas viajaban con la luz del alba.
Pero todas tan sólo eran imagen pálida de Tí mismo.

Pero, ¿cómo divagamos buscándote siempre, si todas las cosas del
mundo son caminos claros para llegar a TI?
¡Lo mismo las primaveras que las rosas!
Lleno de claridad estás en el mundo, alegrándolo todo.
Tu aliento es la inquietud de las flores:
¿Miras hacia los cielos? Todo es resplandor de astros.

Munduban argiz zagoz oropoz dozula.
Arnas deunak darabil loren urdurija.
Begijak goyan dozuz?
Ixar izpi oro.
Loretan lora zara, argitan argija.
Zagozan tokijetan zelan ez idoro?
Ez zindudan baña nai, Zeure argi miak
agertzen eustalako maite danen motza,
euretan barriz gogor neukozan begijak...
Argi orren-barne, eder, soilik erijotza.
Erakutsi zindudan lurreko argijak,
¡iraunkorretan baña nazan igikorra!
Txar bidian zintzua, zeugan aldakorra.

Eta aldendu gurarik jo neban lañora:
gauza oron artetik ametsen altzora.
Gustijetan zengozan, oro zeure maite.
Ikusi ez zaidazan nora juan naite?
Toki bat zan bakarra:
Obenan kolkua.
Aren illun barrura ezin eldu zaite.
Argijak ikus ezin gaba ta lañua.
Nork ikertu leikian neure etxe zar-utza?
Mukurrak eze ziran, dana zan kiatsa.
Ara bere eldu zintzan.
¡Orra min zorrotza!
Zeugan lotu gurarik gixonen bijotza
zeuk ipiñi zenduban poz arteko miña.
Gorako bide erreza barneko samiña.
Malkuak len garoez zeure eskarreraño,
munduko aintzat eta bide-labak baño.

En las flores eres flor, y luz en la claridad.
¿Cómo no te encontramos allí donde estás?
Pero, he aquí, que yo no quería encontrarte,
porque tu luz me manifestaba la fealdad de cuanto amaba.
Yo en cambio estaba sujeto a esas cosas terrenas.
A través del resplandor de tus ojos tan sólo la muerte es dulce.
El brillo de la creación me indicó dónde estabas, pero ¡cúan voluble soy en las cosas eternas!
Soy fiel en los caminos del mal, inquieto en tu amor.

Y anhelando huir de Vos penetré en la niebla:
huí al seno de los sueños por entre todas las cosas creadas.
En todo estabas, todos te amaban con fervor.
¿Mas a dónde marcharé para no tropezar contigo?
Un lugar tan sólo existía: el seno del pecado.
A su negrura profunda Vos no podeis penetrar.
La luz está reñida con las nieblas y la noche.
¿Quién era capaz de visitar mi casa vieja y vacía?
Los troncos estaban muy verdes y todo humo era el hogar.
Pero también llegaste hasta allí.
¡Llegó el dolor!
Para sujetar los corazones de los hombres tu pusiste entre todos los placeres la espina dorada del dolor.
¡Qué camino tan fácil para el cielo es la pena doliente!

Las lágrimas nos llevan más facilmente hasta el cielo que no los senderos llanos y las glorias de la tierra.
Y he aquí que ahora soy como un pobrecito, de quien has de tener piedad. Me resquebraré del todo, cayóse el fruto del corazón.
¿Y quién deseará ahora el erizo de la castaña, si todo es espinas?

Gaxo utza ni natzu, zakidaz erruki.
Oso arrakal nitzan, bijotz muina jausi.
Nok gurako koskola dana bada sasi?

Maite nebazan gauzak juan dira igesi.
Orain txiro nagotzu, baña zatorkidaz.
Malkoen barna zelan argitan zaurkidaz?
¡Poz artian ostera ezin zeu idoro!
Gixon gustijen barnak baidirala zoro!

¡Ene Jauna, Jaun ona, erruki zakidaz!
Txiro arren ez jaurti seme saltzalia:
arantzik ez betestu bere labakijan
bai baña sortu daben garbaizko lorea.
Lenen zauriz josijak dozuz errukijan.
Aitaren maitasunak baitau kututena
gexua dan semia, seme mindubena!



Las cosas que amaba han huido ligeras.
¡Qué miserable soy, cuán pobre!
Pero, he aquí, que por entre llantos te vislumbro con mayor claridad. No podía encontrarte entre las alegrías del mundo y, ¿ahora te palpo? ¡Cuán locos son los hombres todos, Señor!

¡Oh mi Dios, mi buen Dios! Tened piedad de mí.
Por pobre que sea no desprecies a tu hijo traidor.
No mires las espinas de su berbecho, sino la humilde flor del arrepentimiento que ha hecho nacer con llanto.
Los primeros en tu piedad son los doloridos.
Que el amor paterno ama con mayor intensidad, al hijo más enfermizo, al hijo más lacerado.



# Lili-negarra

Mungija'ko ibai ederra,
len gardena, oin ugerra.
Aren altzuan murgildu baita neska liraña.

Goxian goxik latsean,
lats garbijaren ganian
lora bat legez aurkitu eben neskutz bikaña.

Oyal garbitzen arrijan,
oñak erreka garbijan,
goxaldero zan gogai samurrak maite onduan.

Lugin baten irudija,
oron ixilik maitia,
oron ixilik sarturik eukon bere goguan.

Mugija'ko ibai zabala,
ibai ederra bai'dala.
Itxasorantza loraz darua urlo apala.

Lugin mutillak ertzetik
maitasun onez beterik
oroigarritzat eskeiñitako lora zurijak.

Lora bat ibai erdijan,
bitsezko otzara zurijan
neska leunari bialdu eutson lugin gastiak.

# El llanto de las flores

El hermoso río de Munguía,
¡cuán transparente fué antes, cuán turbio hoy en día!
En su seno pereció la joven más linda.

De mañana muy mañanita en el río,
sobre el río cristalino
encontráronla como una flor muerta.

Limpiando las blancas ropas en la piedra,
los pies en la clara corriente,
cada mañana estaba y sus pensamientos volaban llenos de amor.

Ancho río de Munguía,
qué río más hermoso eres.
Tu corriente lleva hacia el mar bellas flores.

Blancas flores que te ofrendan como recuerdo
los labradores desde la ribera.
Flores llenas de amorosos sentimientos.

Una flor en mitad del río,
en una cesta de espuma blanca
envió a la doncella el labrador del monte.

«Roja flor, roja flor,
tus colores semejan
a las fresas que florecen en labios de mi amado»

Río azulado de Munguía,
antes transparente, hoy muy turbio caminas.
En tus aguas ven flores las jóvenes.

«Lili-gorri lili-gorri,
ire marguak dirudi
espan-loretan maitiak loran daukon marrubi».

Mungija'ko ibai urdiña,
len gardena, oin zikiña.
Zeure altzuan neskak dakustez lora zurijak.

«Ator neure eskubetara,
neure esku garbijetara,
maitian ulle-kizkorren antza bere orrijak».

Lilijak irri egijan,
irribarre ibai erdijan.
Naro ebillan lora sorgiña urlo garbijan.

Ibai ertzeko munatik
lilija atzemon gurarik
neskatil arek luzatu eban esku liraña.

¡Ai ene! ¡ordu txarrean!
irrist egiñik munean
erreka altzuan ito-egin zan neska bikaña.

Mungija'ko ibai zabala,
ibai ederra bai dala.
Mungija'ko ibai gardenak loraz urlo apala.

«Ven a mis manos,
llega a mis manos blancas
flor que tienes hojas rizadas como unos cabellos amados»

La flor sonreía en el agua,
sonreía en mitad del río.
Dulcemente caminaba la flor en el agua transparente.

Desde la ribera del agua,
ansiando coger la flor,
tendió la joven su dulce mano.

¡Oh, en mal hora, en mal hora!
resbaló en el barro
y se sumergió en las aguas profundas del río.

Ancho río de Munguía,
antes fuiste muy claro, hoy eres muy turbio.
¡Tu corriente lleva hacia el mar bellas flores!

## Liparra

Zelai-orlegiko gentz-ziar emaro
odeixka zurijan itzala digaro.
Olan eltzen yaku erijotz antzija;
gozartu dagigun larrosen eztija.

Odeixka itzal ori baxen samurkiro
lora-ziar bebil geuria leunkiro.
Laztandu dagidan, ekarzu eskuba:
lora artian kutun ezyatzu mosuba?

Neure espanai adi, pozik barre-egixu.
Bijar maitatuko garan eztakixu...
Liparra gozartu, ilkorrak ba gara;
axe-egatan dabil loren mosu-ikara.

Odeixka itzal ori dabil zelayetan:
–Zorijon aldijak zeben bijotzetan
ezilkortu, arren,–dirauskube zarrak.
¡Bai zera, bai zera, laztandu larrosak!



# El instante

Sobre la paz de la pradera verde, resbala suavemente
la sombra de una blanca nube.
Así llega hasta nosotros la muerte engañosa.

¡Saboreemos la miel de las rosas!
Tan dulcemente como la sombra de la nubecilla,
resbala entre las rosas nuestra sombra,
Trae tu mano para que la bese tiernamente.
¿No amas el beso entre las flores?

Mirando a mis labios, sonríe alegremente.
No sabes si mañana podremos amarnos...
Gozemos el momento, pues somos mortales;
en las alas del viento anda un temblor de beso de las flores.

La sombra de la nubecilla resbala sobre la pradera.
—¡Inmortalizar en vuestros corazones los instantes
de la felicidad!—, nos encarecen los ancianos.
¡Palabras! ¡Besemos con ardor las flores!



# Señai abestu

*Bañena'tar Miren Arantzazu'ri.*

Senarra gexo ogean datza,
soña oñazez beterik.
Emazte onak diru gustija
eralgi arren, alperrik.
Zoritxarraren urratz ixillak
etxian dakus bakarrik.

Seintxubak baña negar dagi-ta
ixilduteko, ameak,
abots alayaz abesten dautsoz
siaska abesti maitiak.
Dingilin dangalan,
Dingilin dan.

Miñak minduta ayots garratzak
bijotza urratzen dautsoe.
Eri zitela..., orok igeska,
bakarrik itxi daroe.
Aren begijak gorri baitagoz
negar latza darijoe.

Neke gogorra. Gorpuba gelan
argi orijen erdijan.
Juale itunak danba dagije
eleiz torreko ganian.
Danba dagije, itunez bete,
sartzen dira bijotzean.

# Cantad a los niños

Yace en el lecho del dolor, el esposo,
recubierto de graves dolores.
La buena esposa gastó sus dineros, pero
todo fué en vano.
Los pasos de la desgracia llegan
a la triste morada campesina.

El niño llora, mas la madre, para calmarlo
canta con voz alegre,
canta dulces canciones de cuna.
Dingilín dangalan, dingilín dan.

Herido por el dolor, se escuchan tristes gemidos
que punzan el corazón.
La enfermedad es contagiosa y todos huyen,
dejando sóla a la esposa.
Sus ojos están rojos y derraman
un amargo llanto.

¡Oh duro trabajo! El cuerpo muerto en la sala,
en medio de amarillentas luces.
Las tristes campanas claman desde
la torre del campanario.
Claman tristemente, y llevan la pena
al doliente corazón.

El niño llora, mas la madre, para calmarlo
canta con voz alegre,
canta dulces canciones de cuna.
Dingilín dangalan, dingilín dan.

Seintxubak baña negar dagi-ta
ixilduteko, ameak,
abots alayaz abesten dautsoz
siaska abesti maitiak.
Dingilin dangalan,
Dingilin dan.

Sarats ondotik gixon altsubak
eruan dabe obira.
«Betiko agur senar on ori,
geure bijotzak il-dira»
Eta begijak atzian duaz
ilkutx baltzari begira.

Gixon gaiztuak kentzen dautsoez
etxeko gauza gustijak.
Senar oneran ogea zana,
atzitu dabe zikotxak.
Laster kanpora urten biarko
ango emazte garbijak.

Seintxubak baña negar dagi-ta,
ixilduteko, ameak,
abost alayaz abesten dautsoz
siaska abesti maitiak.
Dingilin dangalan,
Dingilin dan.

Atzamar meetik kenduten dautse
zillarezko elastuna.
Ezkondu ziran goiz ederreko
gomutagarri leguna.
Zapi zakarrez ate aurrera
erdu da txirotasuna.

Por cerca del sauce llevan cuatro hombres
el cadáver del esposo:
«Adiós para siempre ¡oh, mi buen marido!
nuestros corazones han muerto para siempre».
Y sus miradas siguen por detrás
a la caja mortuoria.

Hombres malvados le quitan todo cuanto tiene,
todas las cosas del hogar.
La cama que fué del esposo,
la han llevado los avaros
Pronto saldrá fuera de su casa
la esposa fiel y buena.

El niño llora, mas la madre para calmarlo,
canta con voz alegre,
canta dulces canciones de cuna.
Dingilín dangalan, dingilín dan.

De su delicado dedo le arrancan
el anillo de plata.
El dulce recuerdo de la mañana
en que se desposaron.
Con vestidos de andrajos llega a la puerta
la pobreza miserable.

«Adiós para siempre ¡oh, blanca casa,
de mis padres!
Si ellos levantaran la cabeza
de la tumba donde duermen,
Pero dejemos todo en el silencio,
dejemos la pobre casa abandonada.

El niño llora, mas la madre para calmarlo
canta con voz alegre,
canta dulces canciones de cuna.
Dingilín dangalan, dingilín dan.

«Agur betiko neure asaben
etxalde argi-zurija.
Jaso balebe asaba ayek
lurpian dauken buruba.
Baña itxi daigun ixil-ixilik
galdu dan etxe minduba.

Seintxubak baña negar dagi-ta,
ixilduteko, ameak,
abost alayaz abesten dautsoz
siaska abesti maitiak.
Dingilin dangalan,
Dingilin dan.

«Igartu dira lora landarak,
igartu dira zugatzak,
Neure ortuban umotu dira
zoritxarraren ematxak.
Lengo maitasun igali leunak
lurrera ditu ekatxak.

Bijotz gogorra euki biar da
asaben etxia izteko».
Eta negarrez geldiro dua
urrun aldera betiko.
Ogija billa seintxu arentzat,
goze ankerra kentzeko.

Seintxubak baña negar dagi-ta,
ixilduteko, ameak.
Abost alayaz abesten dautsoz
siaska abesti maitiak.
Dingilin dangalan,
Dingilin dan.

«Se han secado las plantas todas,
se han marchitado los árboles.
En mi huerto se han madurado
los frutos de la desgracia.
Aquellos dulces frutos de amor
han caído al soplo de la tempestad.

Es menester tener un corazón muy duro
para dejar esta casa amada».
Y sollozando lentamente camina
hacia las lejanas tierras.
¡En busca del pan para su hijo,
para calmar el hambre cruel!

El niño llora, mas la madre para calmarlo,
canta con voz alegre,
canta dulces canciones de cuna.
Dingilín dangalan, dingilín dan.

# Betikoŕa

Juale otsak entzuten dozuz,
il-juale itunak.
Euren ziyua ez dazau baña
zeure barneko alaitasunak.
Nor il-ete dan, itauntzen dozu?
¡Oi neure kutuna!
Il-kanpai orrein ziyo pozkia
¡geure bijotzen maitetasuna!

Zerraldo baltza ikusi dozu,
zeraldo aundija.
Zuriz yantziko mutil gastiak
urrun eroyen illan ontzija.
Zer daroyenentz, itauntzen dozu?
¡Oi neska axuna!
Zerraldo orretan illik daroye
¡geure bijotzen maitetasna!

Obi utxija idoro dozu
aran itunean:
sasi zorrotzak eta bedarrak
illobi baldaŕ ixen gabean.
Nor ete datzan, jakin nai dozu?
¡Oi neskutz kutuna!
or ixen bako obijan datza
¡geure bijotzen maitetasuna!

# Canción eterna

Escuchas el sonido de las campanas, de unas tristes
campanas de muerte.
Pero la alegría que brilla en tu interior no puede
adivinar su causa.
Me preguntas ¿quién ha fallecido? ¡Oh, mi adorada!
El doliente motivo de esas campanas de muerte
es el amor de nuestros corazones.

Has visto un negro ataúd, un ataúd maravilloso.
Jóvenes vestidos de blancura insólita
portáronla muy lejos.
Interrogas ¿qué llevan en su interior?
¡Oh, mi joven engañadora!
En ese ataúd llevan muerto ya, el amor
de nuestros corazones.

Encontraste una tumba abandonada, en el valle
sombrío y silencioso.
Sobre la tumba despreciada, sin epitafio alguno
crecían las espinas agudas y las hierbas,
¿Quisieras saber quién yace en esa tumba?
¡Oh, virgen amada!
En esa tumba sin nombre yace sepultado
¡el amor de nuestros corazones!

## Abestija

Esku orrein laztanez
gaste, urik ez loitu.
Ur gardena bakarrik
gogoen ispillu»

Neskeak esku miaz
urari mosuba:
arri koxkor artian
ura loirik dua.
Ura kanta kantari,
neskea negarrez.
Urak esaten dautso
abostxu samurrez:

«Esku orrein lastanez
gaste, urik ez loitu.
Ur gardena bakarrik
gogoen ispillu».

Neskatxak itun dakus
ur garbija loirik.
Garbitasuna dau amets,
eta eztau pozik.
Abar puntatxu puntan
txindorra kantari,
eta abestuten dautso
neskatil leunari:

# Canción

—Joven, no turbes la fuente
con el roce de tu palma.
Sólo el agua transparente
refleja la paz del alma.—

La joven con sus manos
besaba la clara corriente.
Y sucia entre las guijas corría
el agua transparente.
El agua canta que canta
y la joven suspiraba.
Con voz enternecida el agua
aconseja a la joven:

—Joven, no turbes la fuente
con el roce de tu palma.
Sólo el agua transparente
refleja la paz del alma.—

La joven mira con tristeza
turbia la clara fuente.
Sueña con la pureza,
y llora tristemente.
En lo más alto de la rama
canta el ruiseñor,
y con voz suave dice
a la joven dolorida:

«Esku orrein lastanez,
gaste, urik ez loitu.
Ur gardena bakarrik
gogoen ispillu».

—Abestuten daustazun
txindor kantarija;
zegaitik len ez esan
zeure abestija?
Zegaitik ur ertzean
txinta txintalari,
ez eutsozun abestu
loitu nindunari?

«Esku orrein lastanez,
gaste, urik ez loitu
Ur gardena bakarrik
gogoen ispillu».



–Joven, no turbes la fuente
con el roce de tu palma.
Sólo el agua transparente
refleja la paz del alma.–

-Ruiseñor que me cantas
tu consejo;
¿Por qué tu voz no cantó en otra hora?
¿Por qué junto al agua tranquila
canta que te canta
no dijiste tu canción
al joven que me manchára?

–Joven, no turbes la fuente
con el roce de tu palma
Sólo el agua transparente
refleja la paz del alma.–

# Mendijetara

Urrun giz-otsetatik, menditara nua,
leyak ba loitzen dabe garbi dan gogua.
Bedarte-ziar nabil loratxu artian,
girin bako pitxijak irrika bidian.
Gorrotorik eztauke bedartxu oztiñak,
txori pijuak dira zugaitz atsegiñak...
Neure onduan dua latsa nausikiro,
¡Bijotzoi!, mustau daigun bake au geldiro!
Axiaz itz-dagije makal amestijak,
larrosakaz olgetan mitxelet zurijak,
Neketzaz eztakije zelaiko bedarrak,
euren malkuak dira oyane-altzuan;
lora polita derne iturri onduan.
Abar leka samurrak dardar egitian
euri tantak dixuri oroldi ganian.
Loretan abirik ez dagi gorrotuak,
zerutzaz ames-dagi zelaiko goguak.
¡Poz-eztiz egurazten, bai, atseginkorra!
axian ego-puntan dua geure lorra...
Mendijak alde baten, bestian zugatzak,
¡onaño ezin eldu ludiko ekatxak!...
Oyu artega-ordez, abarrots adija,
eta ur eskutatuben otoi-erasija.
Txori kantea dabil urduri sasijan,
Zelan bixi naiteke negarrez mendijan?

# Huyo a los montes

Apartado de los pasos humanos, huyo a los montes,
porque los afanes manchan el alma inmaculada.
Entre florecillas camino por los hierbales,
y sonríen en el sendero los encantos sin malicia.
Las hierbas azuladas no sienten odio alguno,
y son alegrías de los árboles las canciones de las aves,
Junto a mi lado se desliza solemne un río,
¡Oh corazón! saborea dulcemente toda esta paz!
Los chopos ensoñadores charlan con el viento,
y las mariposas juegan con las rosas.
Las hierbas del prado ignoran qué sea el dolor,
y son sus lágrimas el llanto del alba...
Todas las cosas se aman en el seno del bosque,
la flor nace junto a la fuente...
Al temblar las tiernas yemas de la rama caen
gotas frescas sobre el musgo.
El odio no anida entre las flores,
y sueña con los cielos el alma del prado.
¡Cuán dulce es el pasear gustando esta dulzura!
En alas del viento vuela nuestra pena.
Los montes a un lado, al otro los árboles,
¡Oh, aquí no llega el palmetazo de la tempestad mundanal!
A cambio de los gritos, se escuchan susurros de ramajes,
y la oración murmuradora del agua oculta.
En el zarzal divaga un cantar de pájaros.

Bedar miak diñoe, baita txori onak:
—Zegaitik ete dozak ain txarrak gixonak?—
Pozez danai begira sortzen yat lilura,
eta maitasun egoz banua zerura.
Gitxik dazaben gentzan nabil ameslari,
olan damotsat aintza Urtzi'n emoyari.
Urrun giz-otsetatik menditara nua
leyak ba loitzen dabe garbi dan gogua.

¿Cómo pudiera vivir lloroso en la montaña?
Las hierbas finas y la canción de las aves, dicen:
—Por qué serán tan malos los hombres?—
Mirando todas las cosas me nace un encantamiento,
y el alma vuela hacia el cielo con alas de amor...
En la paz que desconocen muchos, me paseo ensoñador,
y así rindo gloria a los dones del Criador.
Apartado de los pasos humanos, huyo a los montes,
porque los afanes manchan el alma inmaculada.

# Bere illobijan

Urrundik nator lotan datzan illobira;
lo-dagi gotzon-eran, zerura begira.
Gurutz-zuri ganian
adaskatxu gurija,
lili-mosu antzean
usainduten obija.
Arlabal-gain otoika: maitasun otoya
egak zabalik azkar zeru-ziar doya.
¡Maite ori!, zeruban, izpizko yantzijaz,
oroitzen ete zara
egiñitako itzagaz?
«Neure bijotz-dardara
ilta bere zeurekin ixango da beti».
Itz ori entzun neban samurki, samurki.
Txorijak abeslari ta adaska gorrijak
zabal daruaz bere odolezko orrijak.
¡Oi maitasun gelgaya! Larrosondo igerra
ta bijotza dirudin larrosa ederra.
Zatordidaz eskura
eruan zagidazan aintzezko zerura.
Neure odolak gudan gorrituko zaitu
eta nere altzuan atsedengo dozu.
¡Bijotz loratu ori,
zagoz neurekin beti!

# En su tumba

De tierras lejanas llego a su tumba;
como un angel duerme con la mirada en los cielos.
Sobre la blanca cruz
un brote de flor suave,
como un beso florecido
perfuma la tumba.
Sobre la losa oro: la plegaria de amor
con las alas abiertas vuela por el cielo azul.
¡Oh, amada!, con tu vestido de resplandores, en el cielo,
te acuerdas de la palabra que me diste?
«El temblor de mi corazón
será tuyo aun después de muerta».
Todo enternecido escuché esa dulce palabra.
El pájaro canta y el rojo brote entreabre
sus hojas ensangrentadas.
¡Oh, milagro de amor! Sobre el rosal marchito
luce una flor hermosa, como un corazón.
¡Ven a mis manos!
para que te porte hasta el cielo de mi gloria.
Mi sangre te enrojecerá en la guerra,
y descansarás en mi seno
¡Corazón florecido,
permanece eternamente conmigo!

Zeru eder aldian
min zara neu negarrez itun ikustian?
Ixildu da txorija, leun dabil axia,
eta larrosa altzotik tantada donia,
dardar... argizko dizdiz... ixarren antzera,
maite-malko bailitzan jausten da lurrera.

¿En las alturas celestiales
sientes pena por verme llorar aquí abajo?
El ave se ha callado, el viento susurra suave,
y del seno de la rosa, una gota sagrada,
temblorosa, con brillos de luz, como una estrella,
cual si fuera una lágrima de amor, cae sobre la tierra.

# Jaunagan atsedena

*Zeugan lotu-arte, ene bijotzau*
*urduri dago...*

Zuretzaz jardun neban, zuur eskar otsari;
zeure baitan nenbillan, an etzan neurririk.
Ara eltzeko ez-nun burdi ta ontzirik,
nai beteri nenguan..., egiñak, nayari.
Goya zabal eguan larradi ganian
eta senti zindudan gauz oron bakian.
Dana ur-urrun zeunkazun: ixar, mendi ta lur,
ixate orren urrun, maitasun orren ur.
Banekijan zintzala, baña nun Jaun ori?
Argitan, eskutuba zeure egote ori.
Gustijetzaz azturik Zeugan jarri nintzan,
ikus nai zindudala gogoko ekintzan...
Griñetan ez zintzazan, ez atsegiñetan;
Samiña idoro neban laket gustijetan.
Lorarik etzan iñon arantzatxu barik,
arantzetan eztago zeure maitasunik.
Munduko otsen barruban ezta zeure gentzik.
Sartu nintzan barnera: Gogo au artega;
Zeure egonak oso leundu eustan baña...
Nabaitu neban gentza... zerutar usaña.
Menak ixildu ziran, eldu zan goznarra,
argitu yatan soña, ludi au aldatu.

# La paz en el Señor

*Mi corazón está inquieto*
*hasta descansar en Tí...*

En Vos meditaba, alerta a las voces de la gracia;
y divagaba en tu inmensidad, porque no encontraba término alguno.
Para llegar a esa profundidad no tenía carros ni naves,
me sujeté a un deseo, y la realidad fué compañera de ese deseo.
Los cielos estaban abiertos sobre las praderías
y te sentí en la paz de todos las cosas creadas.
Todo lo tenías cerca y lejos: astros, montes y tierra.
Lejos de tu esencia, cerca de tu amor.
Sabía, Señor, que existías, pero, ¿dónde, dónde?
En medio de la luz, es un misterio tu existencia.
Olvidado de todo, me puse a meditar en Tí.
Quería verte en la contemplación espiritual.
No estabas en las pasiones, no te encontraba en los placeres.
No había flor sin espinas y entre éstas no florece tu amor.
Entre los ruidos del mundo no descansa tu paz.
Me reconcentré en mi interior. El alma estaba inquieta.
Pero tu permanencia me tranquilizó del todo...
Noté el bienestar, un perfume celestial.
Acalláronse las pasiones, llegó la meditación,
el cuerpo recobró su luz y se me transfiguró la tierra.
En todas partes estabas florecido por la gracia;

Toki orotan zintzan eskarrez loratsu;
zeuri orri dardara ta iluntzeko ixarra.
Zeure oinkada barik ezer iñon etzan.
Argi ta eder dira egin dozuzanak,
neurriz gauza gustijak daukozuz jakintzan.
Lurreko gurenetan dager zeure indarra,
txikijentzako bere badozuz laztanak...
Batzuk dagerte ala, bestiak eskarra.
Ispillu barriz yakuz emeko gauz danak;
ikurrai soilik gagoz ikus zaituguzan.
Eta senti zindudan arren ludi ontan,
zeure maitasun ori urrun zan oraindik.
Oldozkor jarri nintzan idoro gurarik ..
Bijotzari: – Badakik Urtzi jauna non dan? –
– Ixatez ludi barna, maitez gixon baitan. –
Sakona argitu yatan..., oro ulerkorra;
igar neban gixonen barruko zadorra.
Ulertu neban ondo umien begijak
eskar orrek maitekor egiten dauzala.
Abar ustelak, arren, zeuri yagotzunak
loraz orrillai barre egingo dautsola.
Baña urduri nenbillan, artega gogua;
izkutu batek dana jakin-nai narua.
Eta barru onetan zetan zaran ari
ulertu nairik, lotu nintzan ameslari.
– Argiz zagoz orotan, soñak barriz laño,
zeurerik entzun ezin, oben otsak baño – .
Nok igarri ondarrau? Ete nago itxurik?
Neugan zagoz, ni barriz urrun zeuregandik.
Badakit baña zeutzat autu dozuzanak
bijotzeko urduriz, maite zagizala,

hacia Vos se dirigía el temblor de las hojas y la luz de la estrella.
Nada había sin una huella de tus plantas.
Claras y hermosas son las cosas que has creado.
En tu sabiduría las retienes en orden y armonía.
En las cosas grandes aparece tu fuerza,
pero son tus caricias para las mínimas...
Unas manifiestan tu potencia, otras tu amor divino...
Pero todas estas cosas nos son tan sólo espejos para verte.
En este mundo estamos a las imágenes.
Y aunque te sentí en este mundo
tu gracia estaba todavía muy lejos.
Me puse a pensar en mi interior, ansiando encontrarte:
¡Oh, corazón!: ¿Sabes dónde está Mi Dios?
–Por esencia dentro de la creación, por amor dentro de los hombres.–
Y se me iluminó el misterio..., todo fué claro entender:
comprendí el misterio del alma humana.
Por qué los ojos de la infancia
los hace tan bellos tu gracia divina.
Aquel que tenga marchitas sus ramas, si está a Vos, sonreirá al Mayo con una hermosa flor.
Todavía andaba inquieto, temblorosa el alma;
Un ansia de saberlo todo me portaba continuamente.
Y anhelando saber qué hacéis Vos en el interior del hombre, me paré en un ensueño.
–Supe que eres luz en todo, pero que nuestros cuerpos son la niebla,
que no podemos escuchar tu voz, sino la del pecado.–
¿Quién comprenderá este misterio? ¿Estoy tal vez ciego?
En mí estás, yo en cambio ando lejos de Tí.
Pero sé que a los que has elegido para tu amor

zerorrek azkon bixiz egiten dozula.
¡Atseden neurrigian zeugan datzazanak!
Zeure ate orretan emoyak artzia
ots-egitia baño errezago dala:
Billatzea baxen leun zeuri egotia.
Zeugan maitatzen danik itxi biar eza;
Oro zeu zaralako, muin eta azala.
Yagotzuzan danentzat arru bako leza,
labangarri dan laba oben jarralentzat.
itxubentzat argija, illuna argijentzat.
¡Zeure onari nagon, larritasun barik!
dana baita orrako argizko bidia.
Zeure laztanik gabe eztago lorarik,
esku orrenkandik at eztabil gizonik.
Ludija dago zeure aintz-bidez betia.
¡Atseden bijotz orrek, ez ixan urduri!
Jaunaren zabalean lei orok ixuri.
Betiko poza bertan, maitasun osua.
Arantz begira lotu, aron dan gogua.

les has herido con la flecha de la inquietud para
que te busquen.
¡Descansan en paz sin límites los que te aman!
Supe que en tu puerta es más fácil el recibir que el llamar:
que es más fácil el estar en Vos que el encontraros.
En tí existe en no tener que dejar cuanto se adora;
porque todo lo eres Tú, la médula y la corteza.
Para los que están con Vos, eres camino sin precipicios,
llanura resbaladiza para quienes siguen al pecado.
Luz para los ciegos, oscuridad para los de ojo avizor.
Estéme pues, a tus dones, sin inquietud,
porque todo es camino de luz para llegar.
Sin tus caricias no existen las flores;
lejos de tu mano no divaga hombre alguno.
La tierra está sembrada de tus caminos de gloria.
Descansa por lo tanto, ¡oh, corazón! sin estar tembloroso.
Derrama en la inmensidad de Dios todas tus ansias humanas.
En Él está la paz eterna, el amor completo.
Mirando hacia Él permanece siempre ¡alma que andas de aquí
para allí!



# Artzai ona

Jaunan ardi galdubak,
otzez mindubak,
bazka barik mendijan.
gosez artalde dana,
artzai laztana
ilta zugaitz ganian.

Intzez datorz ardijak,
ardi zurijak.
Yoranez eltzen dira
ilta datzan artzañak
jaki bikañak
daukozan jaunpontzira.

Geure artzai samurra.
Goyan edurra
ta ibarrean ixotza.
Oron jaki epela
ixan daitela
zeure maite-bijotza.

Zeure gorputz garbija
geure jakija
ixaten da nekian...
orren gozotasunak
oron itunak
ditzuliz eskerrean.

# El buen pastor

Las ovejas del Señor andan perdidas;
doloridas de frío.
sin una hierba que comer en el monte.
El rebaño está ambriento,
y el querido pastor
pende muerto desde un árbol.

Cubiertas de rocío llegan las ovejas,
las blancas ovejas.
Llegan ansiosas
al divino sagrario donde el Pastor
que pende muerto, güardó sus
sabrosos manjares.

¡Oh, nuestro dulcísimo pastor!
La nieve brilla en el monte,
la niebla oculta el valle.
Que tu amante corazón sea
el divino manjar
que alimente nuestras almas.

Que tu purísimo cuerpo sea
nuestro pan celestial en la hora
del dolor.
Tu dulzura
sabe cambiar en gracia las tristezas
de todas las almas.

Jaunan ardi galdubak
otzez mindubak,
bazka barik mendijan.
Gosez artalde dana
artzai laztana
ilta zugaitz ganian.

Las ovejas del Señor, andan perdidas.
doloridas de frío,
sin una hierba que comer en el monte.
El rebaño está ambriento,
y el querido pastor
pende muerto desde un árbol.

# Zaurija

Euna tarrat-nenduban, arantza batean
neure maitasun billa juan nintzanian,
Josteko zeuri nintzan.
Joskillaen ekintzan
lorapian zengozan zurezko aurkijan.
Eunduten zendun arin zapitxu zurija,
orratza esku-mian, otzaran arija.
Gaste bat lotzen zendun zapiño garbijan;
txirula joten eta ardijak gordetan,
txakur mustur gorrija etzunik oñetan.
Neska polita zintzan
joskillaen ekintzan.
– Josiko dautzut pozik, – zeuk, berba samurrez – ,
Belaunbiko nintzaizun, bijotza bildurrez,
Zeure atzamar miak bullarran ganian
leunkiro sentitzian
mutil politari so-negijon dardaraz.
Oro nintzan azkuraz...
Laster uxatu zendun ain amets gozua.
¡Zeure bijotza dozun erruki bakua!
Yantzija josi barik,
leunki, bildur bagerik
zulatubaz bijotza
sakon sartu zeunstazun jostorratz zorrotza.
Eta neure soñeko tantatxu laztanak
gorri egin ebazan mutillan espanak.

# La herida

Desgarré mi túnica en los zarzales del camino
al ir a buscar a mi dulce adorada.
A tí llegué para que me la compusieras.
Bajo un rosal de flor, en un banco de madera,
estabas cosiendo...
Bordabas en un blanco tejido.
Entre los dedos tenías la aguja, el hilo en la cestilla.
Bordabas un joven en el blanco pañuelo;
hacía sonar una flauta y guardaba el rebaño,
un perro de hocico bermejo yacía a sus pies.
¡Qué niña tan linda parecías
en tu oficio de costurera!
-Te lo remendaré muy contenta,-me dijiste dulcemente.
De rodillas me postré, tembloroso el corazón.
Y al sentir la caricia de tu blanda mano
sobre mi pecho
miraba con envidia a aquel joven que bordabas.
Era todo un ansia...
Pero cuán pronto desfloraste aquel ensueño.
¡Qué corazón tan duro el tuyo!
En lugar de repasarme el manto,
suavemente, sin timidez alguna,
punzándome el corazón,
me adentraste tu aguja afilada.
Y con la sangre que manaba de mi cuerpo
enrojeciste los labios de aquel joven.

# Miren'i otoya

*Gabonillaren 8'gn.*

Oben-zauri mingotsen
osakai bakarra!
Zeure maitasun orrek
dezeingu negarra.
Bijotz-ikaraz gagoz
¡oi geure Neskutza!
Esker dizdiz darozuz
gogo ta gorputza.
Espan zerutar orrein
leuna gozartzian
itxarua sortzen da
oben itzalpian.
Geure samin artera
jatziko Onespena.
¡Arren, Ama, jadetsi
lixun-azkespena!
Didar dagin bijotzak,
Miren errugia,
egin zaituz zeruko
maitasun atia.

Zeure garbitasuna
geuregan ixuri.
Soin ta gogoz diraugun
garbi eta zuri.
¡Ama on, bijotz-bera!
gotzon atsegiña.
Begi orreik baitira
barneko urdiña.
Errugabe bakarra,
neure bijotz illa
itun zeugana dator
bakuntasun billa.
Orok ezezten daben
bijotzan malkua
altzo orretan dimintzut:
¡O, Miren gozua!
Jaunaren al-alatza
ixadi gustija,
Maite-alatza baña
Zeure Sorkundia.

# Plegaria a la Virgen

Unico remedio de las heridas que produce el pecado.
Ese tu amor nos cura las lágrimas.
Con temblor de corazón, estamos, ¡Oh, Virgen Pura!
llevas todo de luz el cuerpo y el alma.
Al sentir la caricia de tus labios maternales,
renace la esperanza bajo la sombra del pecado.
Bendición divina que bajaste a nuestras penas.
Por piedad, ¡Oh, Madre! consíguenos la pureza del alma.
El corazón que te invoca, ¡Oh, María concebida sin pecado!
te ha convertido en puerta única del paraiso.
Derrama tu pureza sobre nosotros,
para que en cuerpo y alma, seamos hijos tuyos.
¡Madre piadosa, de tierno corazón!
eres el placer de los ángeles. Tus miradas son el
azul de nuestras almas.
Unica sin mancha, mi corazón muerto,
triste marcha hacia Vos, para encontrar la inocencia.
La lágrima que todos desprecian,
te la pongo en el seno, ¡Oh, Virgen amorosa!
La creación es el milagro del poder de Dios.
Tu Concepción purísima, es el milagro de su amor.

# Siaskakua

*Gojeaskoetxea'tar Joseba Mirena'ri.*

Galtsu ganian, lotan ixarra;
gixon gustijen ixar bakarra.
Ixar eder orren maitasun izpijak
beraganantz daroz minduben begijak.

Miren'en ixar, bitxi-argija,
lo-aruan da ume zolija.

Maitasun-zale da kutuntxuba;
Ene bijotzoi, lei onez bua
Leunki, urratu naz, leunki beragana,
ta espan-loretan damotsat laztana.

Maitati lotan dago seintxuba,
Bere zereiña... amets goxua.

Neskutz zerutar baten emoya,
errukiz entzun neure otoya.
Belarri ondora samur itz-dagitzat,
Josu'k baña eztau berbarik neuretzat.

Maitasun zalez datorrenari
erantzun ez-ta maitale-egarri?

# Cunera

Sobre las pajas duerme la estrella;
la única estrella de todos los hombres.
Los rayos de amor de ese astro
llevan hacía sí los ojos de los doloridos.

¡Estrella de María, perla clara!
Duerme el niño sobre las pajas...

Tiene ansias de amor el pobrecito.
¡Oh, mi corazón, llega hasta El!
Suavemente me acerco, suavemente,
y el beso en las flores de sus labios.

Dulcemente duerme el niño,
Su trabajo... es un dulce sueño.

Don de una Virgen celestial,
escucha con amor mi plegaria:
Al oido él murmuró tiernamente,
pero Jesús no escucha mis palabras.

¿Cómo si ansías amor, desoyes la plegaria del que
muere de amores?

¡Oi, lo aruan dago aurtxua
bere zereiña... amets gozua!
– Gurutze ganian eskeita dagola,
Tantaka emoten Jaungoikozko odola. –

Galtsu ganian lotan ixarra;
gixon gustijen ixar bakarra.
Maitati dago lotan aurtxua,
Bere zereiña... amets gozua.

¡Oh, el niño está durmiendo,
Y su trabajo... es un dulce sueño!
—Sueña que colgado de la Cruz,
derrama por mí toda su sangre divina...—

Sobre las pajas duerme la estrella;
la única estrella de todos los hombres.
Duerme el niño
y su trabajo... es un dulce sueño.

# Artxanda ganian

*(Maioresque cadunt altis de montibus umbrae).*

Gabaren begijok, maitekorrak yataz,
 Legunduten nabe!
Euren sakonean betirauna dakust;
 Bakia ertz-gabe.
¡Bijotz mindu orrek, tolestu eguak,
 Onduan zadorra!
Barnera bil adi, gaba, alde oneitan,
 goyan artixarra.
¡Ene lei bixijok, orra gau sakona!
 Bixitz-izkutuba,
eure iluntze ori ixango ete dok
 orren gentzatsuba...?
Gaba ixilik dabil, argizko koroya
 darabil buruban.
Gotzonen eguak dardara dagije
 zeru oztintsuban.
Lugiñak etxerantz, idijak atzian,
 begitan bakia:
zelai orlegijak damotsen bakia.
 ¡Oi arrats donia!
Baserriko kiak urdiñera digo
 mendixka ganetik.
Iltzalak bailiran gautxorijak datorz,
 torrezaŕ aldetik.

# Sobre el Archanda

*(Densas sombras van cayendo*
*desde las altas cumbres).*

Cuán queridos me son los ojos de la noche,
del todo me enternecen!
En su profundidad vislumbro la eternidad;
la paz sin términos.
¡Oh, corazón dolorido, pliega tus alas,
he aquí en tu derredor el misterio!
Reconcéntrate en tu interior, la noche en estos contornos,
en el cielo la estrella vespertina.
¡Oh, ansias vivísimas, mirad la noche profunda!
Y tu vida misteriosa;
¿será tu atardecer tan embalsamada de paz,
como la de esta tarde divina?
La noche camina silenciosa, lleva una corona de astros
sobre su frente.
Las alas de los ángeles producen un temblor
en el cielo azulado.
Los labriegos llegan a sus casas, síguenles los bueyes
que llevan la paz en sus ojos
la paz que les infunde el verde prado.
¡Oh, noche divina!
Al azul asciende el humo de la casería
desde la testa del monte.
Cual si fueran sombras nocturnas vienen
de la vieja torre, los pájaros de la noche.

Erroka txadonan kanpa-otsa dantzut,
arana ixil beyna.
Durundi ots orreik mendiz mendi duaz.
Otoyak zelayan...
Zugatzetan keska barik ganduba da...
Ta neure goguak
goznarrari miñez ekiten baidautso:
¡Uler nai zadorrak!
Bitartian anei argi uri ortan
agertuten dira.
Alde oneitara bere elduten yaku
tximisten dirdira.
Uriko saratak keskatuten dabe
mendiko lilura.
Nora juan ete da txaide artetik
gentzazko lo-gura?
¡Uriko gau ori! ¡Maltzurren laguna!
Baserri aldera
zetan eltzen zara, argi orrein kiñuz,
gaizkiñen antzera?
Zeure altzo orretan txerren danak duaz
lan okerretara...
Ega-motz ertzakaz leyo danak-ziar
dagijen dardara!
Lixuna txaidian ixil-ixil dabil
lora zimal billa.
Loari murrika etxe artietan
gastetxu zurbilla.
Gabaren eskubak ito dau lotzea.
¡Or dabil obena!
Il dabe gaizkiñak oraindiño neskutz
datzan onoimena!

En la ermita de San Roque escucho sonidos de campanas:
El valle a lo lejos está en silencio.
Esas campanadas corren de monte en monte...
Las plegarias florecen en las praderías.
La bruma se enrola a los árboles, sin inquietud alguna...
Y mi alma está a la meditación
sin dolor ni pena.
¡Anhela comprender el misterio!
Entretanto mil luces se encienden en la ciudad cercana.
También aquí nos llega el resplandor
de la electricidad.
Los ruidos de la ciudad enturbian el encanto
de la montaña.
¿A dónde huyó de entre las calles,
el ensueño tranquilo?
¡Oh, noche de ciudad! ¡Amiga de los malvados!
Para qué llegas hasta el caserío
con los guiños de tus luces,
como si fueres un malhechor?
En tu seno los demonios corren
a sus trabajos de perdición...
¡Qué rumor producen con sus alas
rozando los cristales de las ventanas!
Silencioso divaga en la calle el lujurioso
ansiando flores marchitas...
Y burlándose del sueño entre calles camina
el pálido jovencito...
La mano de la noche ha ahogado la vergüenza:
El pecado se pasea tranquilo.
Los malvados han ahorcado la virtud
que aún permanecía virgen.
Una sábana de blanca niebla cobija
la enorme ciudad.

Lañozko maindira zurija baidager
uri zabalean.
Lausua ta kia toki gustijetan:
¡Bil nadin barnean!
¡Iluntze oztiña, gotillun nagotsu!
Lei bixiz bijotza.
Zer ete ditxarot? Samiñen bixitza?
Pozen erijotza?
Ona emen nago: Goxian so-dagit
sarkalde argira.
Arratsean barriz sorkaldera nago,
ixarren begira.
¡Au geure bixitza, atseden eziña,
jadetsi eziña!
Ezin batu doguz elburu batean
amets ta egiña.
¡Oi gau zerutarra! zeure gai eztira
ludiko gixonak.
Otsetatik urrun loratuten dira,
zeure zorijonak.
Une eder onetan, arren, itxi urija,
itxi ots gaiztuak.
Lei bixiz barnia, urrunera nuan,
iges begist luak...
¡Arrats bijotz-bera! Zeugan amets dagit.
Atseden bijotzak.
¡Ene!, orreik baxen izpi baketsubak
bekarz erijotzak!
Oztin begoz goyak, itzalez mendijak,
gogo ua bakian.
Ta itxaro ixarrak argi dizdiz begi
bijotzan barnian.

En todas partes se ve la bruma y el humo.
¡Oh, *reconcéntreme en mi corazón*!
Noche azulada, cuan triste te contemplo,
con deseos eternos el alma.
¿Qué es lo que espero? ¿La vida de las tristezas,
o la muerte de los placeres?
Aquí estoy: al amanecer miro
hacia el poniente esplendoroso,
y al atardecer en cambio ansio admirar los astros
que trae el alba.
¡Esta es nuestra vida! Sin poder descansar jamás,
sin poder conseguir lo que se desea.
No podemos unir en un abrazo
el ensueño y la realidad.
¡Oh, noche celestial! Los hombres no son dignos
de tu dulzura.
Tu felicidad florece lejos de los
ruidos humanos.
Dejad en este momento hermoso la ciudad,
dejad los ruidos malvados.
Con deseos eternos el alma, quiero huir lejos,
el sueño despídase veloz...
¡Oh noche de corazón enternecido! Sueño contigo.
Descansa mi corazón.
Traiga mi muerte unos rayos tan serenos
como tus besos.
¡Estén azules los cielos, cubiertos de sombras los montes,
el alma tranquila.
Y que la estrella de la esperanza brille, clarísima,
en lo más recóndito de mi corazón.

## Goxaldeko-edurra

Atsegiña! leyuak zabal egitian
eduŕ zuriz zelayak dizdiz ikustea!
Aldaturik dagergu ixadi amea:
garbitasun yantzijaz dago goxaldian.

¡Anai oi! leyora atoŕ: Orra oŕ alatza!
Ikusi zuritasun alatz amestija
Edurren gogo-leuna bai-dala garbija!
Gaiztakerige dago zelaiko matatza.

¡Berak legez nok leukon garbirik gogua!
¡Dizdiz ori nok leukon bijotzan barruban!
Leyora ator, edurra atrapau eskuban:
bere mosuba otza, baña dan gozua!

Otzak goyan ebaita jausi dan lorea,
mitxileta antzera yatorku lurrera.
Ez eruan maitati espanen ganera
geure laztanak dira bere erijotzea.

Gaŕbitasun mosuba artu dau edurrak.
Gotzonak soilik dira bere laztanen-gai.
Lora ganetan datza garbi baxen alai:
Egotxu zerutarrak loitzen dautsoz lurrak.

Edurra! soilik zatorz siaska ondora
eta lotan dagozan iltegijetara...
Umiak eta illak zeure izpi ixara
eztabe loitzen. ¡Zatorz garbijen kolkora!

## La nieve de la mañana

Oh, placer! al abrir los ventanales
vése esplendorosa de blanca nieve la verde pradería!
La madre naturaleza muéstrase transfigurada:
el amanecer ostenta su vestidura de pureza.

¡Oh, hermano! ven a la ventana: Mira ahí el milagro,
el milagro ensoñador de la blancura.
¡Cuán blanca es el alma inocente de la nieve!
El copo del prado está sin malicia alguna.

¡Quién pudiera tener el alma limpia como ella!
¡Quién pudiera retener dentro del corazón su resplandor!
¡Ven a la ventana! recoge entre tus dedos la nieve.
Su beso es muy frío, pero cuán suave!

Flor que cortó el frío en los cielos,
como una mariposa cayó sobre la tierra.
No la lleves amoroso a tus labios
porque nuestras caricias son su muerte.

Ha recibido ya el beso de la pureza.
Tan sólo los ángeles son dignos de acariciarla.
¡Sobre las flores está tan pura y tan alegre!
La tierra mancha sus alas celestiales.

¡Oh, nieve! ven tan sólo a posar sobre las cunas
o sobre los sepulcros que yacen dormidos.
Los niños y los muertos son tan sólo los que anhelan
tu sábana de luz. ¡Ven al seno de los inocentes!

¡Oi eduŕ-zuri! eduŕ-zuri! eduŕ-zuri!
Ikasbide zayataz bixitza onetan.
Garbi dirauzu beti ekaitz gogorretan,
arri ganian bere beti zara guri...

Eduŕ ikasbidia ez aiztu anaya:
Oñazez ixan arren, zadiz tolesgia.
Garbitasun diztiraz bego zeure etxia,
eta zeure gogua beti gotzon-gaya.

¡Oh, blanca nieve! Blanca nieve! Blanca nieve!
En esta vida me sirves de ejemplo
Aun en medio de las tempestades permaneces pura,
sobre las piedras estás siempre tan blanda...

¡Hermano mío! no olvides el ejemplo de la nieve.
Aun entre dolores sé siempre sin malicia ni maldad.
Tu casa conserve siempre un resplandor de albura,
y sea tu alma digna de un querubín...

# Ezilkortasuna

*R. Añibarro'tar Bitor adizkidiari.*

Neure egunen gezija ilkorrari dago,
ezilkortasun-otsa baitot maitiago.
Zertako erijotza?
Itun diranentzat
atseden-toki, baña ez bixitz-zaleentzat.
Gerokuari bildur, beti Ixan nai neuke.
Gauzak ileza barik ziyorik eztauke,
Egunak iges-eta ots-dagit barnetik:
¡Ez nagixu atara betiraun bidetik!
Neure zale orotan, Jainko edo Gixon,
mundu-oste danari nagokijo aron.
Jainko banintz ezneuke erijotz bildurra.
Aldijak ba soil desiz zeru eta lurra.
Urtziki gauza oro?
¡Ez, oro aldakor!
Gaur loraz daguana bijar baita legor.
Urtziki balitzakez, ixaki gustijak,
¡Zoritxarrena geuri!
Ezkara urtzikijak
aren maitasun-izpi edo mosu baño.
Ezilkortasun nairik Jaunguak eztauko,
betiraun osoena berbera dalako.
Ilkor danaren deyak neure nayok barriz;
Emen nabil deus ez-ta Jaungoiko egarriz.
Urtiak baduazi, urratzik eztager,

# La inmortalidad

*A Víctor R. de Añibarro.*

La flecha de mis días apunta a la muerte,
pero amo con mayor pasión la voz de la inmortalidad.
¿Para qué sirve la muerte?
Lugar de refugio para
los tristes, mas no para aquellos que adoran la vida.
Con el pavor del Luego... ¡qué ansias me dan de Ser siempre!
Las cosas no tienen explicación, sin la inmortalidad.
Los días me huyen y clamo desde el fondo de mis entrañas:
¡No me desvieis del camino de la eternidad!
En todos mis deseos, Dios u Hombre,
miro con inquietud a lo que se oculta tras de este mundo.
Si fuera Dios no temería la muerte,
pues el tiempo tan sólo ciñe a la tierra y al cielo.
¿Cuanto existe es panteista?
No, que tan sólo es evolución. Lo
que hoy sonríe como flor, mañana será ceniza. Si cuanto existe
fuera esencia divina,
¡cuán desgraciados nosotros!
Pero no somos parte de Dios, sino
beso o resplandor de su amor.
Un Dios jamás siente anhelos de inmortalidad,
porque la eternidad sin términos es su existencia.
Mis clamores, en cambio, son ansias del que es mortal.
Aquí ando inquieto, yo nada, con sed de Dios.
Los años me vuelan, y no dejan rastro ni huella.

Non galtzen dira-edo?
¡Albaneukaz ulef!
Gixon-utz nazan arren eztot deuseztu-nai:
Naikun oneik ez ete ezilkortasun-gai?
Ixatiari dagoz neure gurarijak,
ezilkortu albaneuz oldozkun gustijak.
¡Une gozo batean lo-iraungo baneuke
betiko ames oneik amest-egin arte!
Geruan ezer danentz zalantzetan nabil:
goguari min-yakon arrizku onduan
jolasetan ibilli, oso baita edeŕ.
Zegaitik darabilgu zale au goguan?
Goi-atiak jo-dodaz;
dana dagir ixil.
Itxas orren zabalan ontzirik eztager.
Ezilkortasun-billa lor ta atsekabez
adimenan esanak idoro nai dabez...
¡Gauz oneitan baña soil gagoz bijotzari!
Pozikago baigagoz itxaropenari.
¡Oi, ziñismen arroña bedi gogaikija!
laño-barik daguan ixarren argija.
Betirauna neuretzat argi-antzo baita.
Itzal-bildur naz, itzal erijotza da-ta.
Amayera bakarrik ete da geruan?
¡Gogai orreik ez begoz sano dan goguan!
Itun-beti, beti-itun onexek narabil.
Gero ezer eztala?
¡Arren, zagoz ixil!
¡Ona, betiraun nayez, Jainko gozez nabil!
Beragan biurtzeko ixate bidez, ez,
esi dagidan baño neure maitasunez.
An itxarrik dagiket amest-ederrena,
Ta alkarren baitan ikus, asija ta azkena.
Urtzi besarkatuko neuregan nai-bidez.

¿Dónde se pierden?
¡Si pudiera comprenderlo!
Aunque soy hombre, tan sólo, no quiero perecer.
¿Tal vez no son dignos de inmortalidad estos anhelos?
Al Ser siempre están apuntando mis deseos,
queriendo eternizar todos los pensamientos.
¡Si pudiera descansar en un momento delicioso
para soñar estos mis sueños eternos!
Ando en la duda de lo que luego vendrá;
¡Es tan hermoso jugar, confiado, junto al peligro
que tanto inquieta al alma!
¿Por qué llevamos este deseo en lo interior?
He golpeado las puertas de lo alto;
todo está silencioso. Ninguna
vela aparece en la inmensidad de ese mar.
Añorando la inmortalidad, con trabajos y dolores
ansían encontrarla en los consejos de la inteligencia.
Pero en estas cosas tan sólo se debe escuchar al corazón. Más
confiados estamos a la esperanza.
¡Oh, que el fundamento de nuestra fe sea un ideal!
la luz de un astro que jamás vió la niebla.
Para mí la inmortalidad es como la luz, la claridad.
Tengo miedo a la sombra, porque la sombra es la muerte. ¿Tan
sólo está el fin en el Después?
¡No florezcan estas ideas en el alma sana!
Siempre triste, triste eternamente me trae esto.
¿Que nada existe luego?
¡Por piedad, no hables, calla!
He aquí, con anhelos de eternidad, con hambre de Dios, no ceso.
No para transformarme en Él, por esencia,
sino para abrazarle por medio de mi amor.
Allí despierto podré soñar el sueño más hermoso,
y ver en un punto, el comienzo y el término, confundidos.
Por medio de mis deseos, me ceñiré a mi Dios.

Gomuta ezilkortu nai dabe gixonak;
¡Zoruok, zuben opak eztira sakonak!
Ametsen ondartzetan uñen apar-tzale.
Ezdakusube gauzen ezerez-utzena?
Munduban ezilkorrik ezer ez, ezer ez:
Iges duan Itzala soñen jarraitzale.
Gustijak dagoz gexo erijotza-miñez:
Iñok ezdazauan min bixijak jo-gaitu
Eta gorputz atalak ditxiguz bidian.
Soña jauskorra eta gogua goi-tzale,
aurka diran gauz oneik, nok osuan neurtu?
¡Lurra, lurra daukogu begijen ganian!
Edertasun-zirrintan digart betirauna,
Osuan baña nago, nai oneitan Jauna?
Geruan...? Joko auxe jokatu biarra.
Baña bixitz onetan geure betikorra
gertu geinke osoro onoimen bitartez.
Oraingo azi oneik geroko uztea,
irotasun artetik eztator lorea.
Gorrotoz barik nuan maitetasun-bidez.
Erain zidor orotan ezilkortasuna,
zauri bakotxan leunki mosu bat ixuri,
etsayaren burura jaurti maitasuna.
Arantzak min-zaitubez?
¡Arrika ez lorai!
Arrizkuban ibilli gentzaz, ez urduri.
Lakijorik ez jarri iñon oldozkunai.
Egiten dozun ona gerokora dago,
ondo egiñak ezauz oker eruango,
Zalantzan zaran, arren, ezilkorra maite;
—zeozer geure baitan badogu betikoŕ,—
Gerora adi beti, urduri, oldozkoŕ,
alderik onenera eratzatu zaite.

Los hombres quisieran eternizar su recuerdo:
¡Locos, que son poco sublimes vuestros deseos!
Amáis la espuma de las olas de la playa de los ensueños.
¿No miráis la infinita vanidad de todas las cosas?
En el mundo nada existe duradero, nada en absoluto.
Son sombra que sigue al cuerpo...
Todos están enfermos con el dolor de la muerte.
La enfermedad cruel que nadie conoce, nos ha herido,
y vamos dejando trozos de nuestro cuerpo en el camino.
El cuerpo corruptible y el alma soñadora de ideales:
¿quién comprenderá estos términos opuestos?
¡Cuánta tierra llevamos en nuestos ojos!
Por resquicios de belleza vislumbro la inmortalidad,
pero ¡oh, Dios de mis ansias! estaré en la verdad?
En el Después...? Tenemos que jugar esta partida.
Pero en esta vida podemos preparar la inmortalidad
por medio de nuestras virtudes.
La siembra de hoy, será la cosecha de mañana.
Jamás de entre la podredumbre nació la rosa.
Camine yo, no por los senderos del odio, sino del amor.
Siembre en mis caminos la inmortalidad;
en cada herida derramaré un beso,
sobre la cabeza del enemigo lanzaré brasas de amor.
¿Te punzan las espinas?
No apedrees las flores.
Anda tranquilo en los peligros, no desasosegado.
Ni pongas lazos a los pensamientos de los demás.
Lo bueno que obras está mirando al Luego,
nunca te llevará por mal camino lo bien hecho.
Aun cuando andes entre dudas, ama la inmortalidad:
—algo hay dentro de nosotros que es eterno.—
Mirando al Después, siempre inquieto, pensativo,
acuéstate al lado más favorable.

# Itzarrik

Miñezko biden eta lorbatek narabil,
iratzartu baitat lotan zan gogua,
¡Dan zizta gogo au itzarrik erabil!
Ezin maite daiket gatxurren jokua..,
Egiñen uarkoŕ darakust zuzena,
neurriz baña gixak eztau bixi-gura,
Gozartu nai leuke gauz oron lilura.
Baña itzarrik ago, ¡oi ene barrena!
Zergaitik diraustak lortuben barkua?

—Itzarrik, ta arrika lorai ete ago?
Esku orrek baiyok lepalpen geyago.—
Orixe ostera nai neban igesi:
Barna lotan dala gustija baita utzi.

¡Ene barna orrek, bixitza onetan
lo-egin, lo-egin!
Ekintza danetan
soña bedi-alde ez baña gogorik.
Emaitz mota asko derne ametsetan:
Gogua lotan, nork urten al-luditik?

Geure barna ixilik lotan dagonian
itzala ta gentzat baitira etxian,
Barneko giriñak duaz baña atara
onbidian lapuŕ:
Ostuten dauskube

# Vigilante

Por caminos de dolor me lleva una angustia,
pues se ha despertado el alma que dormía.
¡Cuán punzante es el sobrellevar despierta el alma!
Ahora no puedo acariciar el juego de los peligros;
vigilante de cuanto obro me señala el camino recto,
pero lo *humano* que porto no quiere vivir con trabas.
Anhela gozar de la fascinación de todas las cosas.
¡Estás despierta, oh, alma mía!
¿Por qué me señalas el límite de lo que he logrado?

—¿Andas despierto, y apedreas las flores?
Esa mano carga con mayor responsabilidad—:
¡y yo precisamente quiero rehuir eso!
Cuando la conciencia duerme está todo permitido.

¡Oh, conciencia mía, en esta vida
conviene que duermas, que duermas largamente!
En todas las acciones
el cuerpo debe ser el responsable, pero no el alma.
En sueños maduran toda clase de frutos...
¡Quién pudiera salir de este mundo con la conciencia dormida!

Cuando ella duerme, la casa está silenciosa, llena de paz.
Entonces salen las pasiones hacia lo exterior,
—ladrones de nuestras virtudes—:
Y todo lo deshojan

loran zan mertxika, garan zan landara,
lorategi dana ondatuten dabe.
Bixitza onena lepalpen bakua,
orretarako lo daukagun gogua.

Argi barik guaz oro zapalduten
baña eztakigu zer dogun egiten.

Lotan nagusija?
¡Galduba da jauntza!
Maitasun baratzan sartu da basauntza.

Miñezko bideetan loŕ batek narabil,
iratzartu baitat lotan zan gogua.
¡Samiñaren miña! orain ernai nabil;
begitatik juan yat betiko lua,
begizkun leyora baiyagert gogua.
Badua eskuka yuaten lekura,
eta laster duler laketen bakura.
Orain griñai barik goguari nago
soña guren bada gogua ariago.

Lo-eguan eta loitu neban oro:
Errota ebillan, etxia lausoro.
Lo-aldi orretan egin dodazanak
lepalduko daustaz gogoen Jaun danak?
Barnak zabaldu dau barruko leyua...
Oro argi dakust soña dago ba ixil.
Miñezko bideetan lor batek narabil
Iratzartu baitat lotan zan gogua.

el albérchigo que estaba en flor y la planta que espigaba. Nos destrozan totalmente el jardín.

La vida más bella es la irresponsable,
mas para ello conviene que llevemos el alma dormida.

Entonces caminamos sin luz pisoteándolo todo.
Pero no podemos apreciar lo que hacemos.

¿Duerme el señor?
Se perdió la propiedad.
En el jardín del amor ha entrado la cabra-montés.

Por caminos de dolor me lleva una angustia,
pues se me ha despertado el alma que dormía.
¡Dolor de dolor! Ahora ando vigilante,
huyó de mis párpados, para siempre, el sueño.
Y asoma el alma a la ventana de mis miradas.
Ella marcha al sitio que tiendo la mano,
y al momento comprende la licitud de los placeres.
Ahora estoy atento al alma y no a las pasiones,
pues si bello es el cuerpo, mucho más lo es el alma.
*Dormía* y yo la *manché completamente*;
el molino no cesaba de trabajar y el polvo de harina
cubrió la casa.
¿El dueño de las almas me hará responsable
de cuanto obré cuando dormía la conciencia?
Ella ha abierto la ventana interior...
Todo lo ve ahora claramente, pues el cuerpo está silencioso.
Por caminos de dolor me lleva una angustia,
pues se me ha despertado el alma que dormía.

## ¡Itxasora!

*Onaindia'tar Alberta'ri, bijotzez*

Soñutzik ontzi-puntan, sakoneko lemazain,
itxaso-barne nua zidor ezezaunen-gain.
¡Ondartzan oro laga! —arrizkubak darraigu—,
Lur-barri billatzale ametsa lagun dogu,
Liorreko lokatzok geure malkoz egiñak.
Arnas-artzeko, billau,
amaibako urdiñak.
Euren solas utzakaz gixonak lotzen gabez;
Azkatasun oldiak ilten dira atsekabez.
¡Aurrera! Iparraldian edur-mendi ixoztubak,
eta ugarte otzetan lamiñen gazteluhak.
Eruango zaitubet:
—eunak arro axian—,
Itxaropena bai'dot begi onein ganian.
Bide barrijak nai-dauz abendaren kezkeak:
Lar lurrari egon da.
¡Zabaldu ozertzeak!
Ekintza gurenentzat landa au dan zabala,
Izki-mota orontzat burdinori garbala.
¡Geure itxaso gogorra, abendak maite zaitu!
Zeure altzora gatorz lurra ba txiker yaku.
¡Indar irakasle oi,
kendu odei ta laño!
Balerik eztogu nai gogai barrijak baño.

# ¡A la mar!

*A mi amigo D. Alberto de Onaindia.*

Desnudo sobre la proa del barco, piloto de la altura, recorro los mares por caminos desconocidos.

¡Dejad cuanto poseís, en la playa!-porque el peligro nos acompaña;-

Buscadores de nuevas tierras el ensueño nos sigue.

Todos los lodazales de la tierra están amasados con nuestros llantos.

Buscad, pues, nuevos horizontes para respirar con libertad.

Con sus palabras vacías, los hombres nos retienen y los ímpetus de libertad mueren dolorosamente.

¡Avante! Ved allá en el Norte los helados montes de nieve y en las islas yertas, los castillos de las sirenas.

Os llevaré muy lejos:—las velas turgentes a los vientos.—

Sobre mis ojos brilla la esperanza.

La inquietud de la raza requiere nuevos rumbos: ha estado demasiado sujeto a la tierra, ¡Abridle nuevos horizontes!

¡Qué campo tan inmenso es el mar para las proezas heróicas, bronce insigne para grabar toda clase de letras!

¡Oh nuestro bravo mar, la raza te ama!

A tu seno venimos porque la tierra es muy pequeña para nuestros anhelos. ¡Oh maestro de energías, borra las nubes y las nieblas!

No ansiamos cazar de nuevo las ballenas, sino ideas incontaminadas.

La aurora brilla con nuevo vestido de oro...

Aquí llegamos, pues, con sed de sabiduría...

Argizkorrija dager, urrezko yantzi-barriz.
Ementxe gatorkixuz jakintzaren egarriz.
Ametsik ezkenduban legorretan egiten,
Uraren barna baña goyak doguz ikusten.
¡Geure itxaso gogorra!
Gogayen arraunlari
Agur egiten dautzu itxaro argijari.
Soñak esitzen dozuz, goguak ariago:
Geuregan legez, zeugan, beti kezka bat dago.
Sakon ori nok dazau?
¡Oso zara zadorra!
Ekaitz orrein orruba koldarren bildurkorra.
Euzkuak soilik dabiltz altzo zabal orretan;
Imin dozu oldia euren begi barnetan.
Gudarijak dagixuz, berunezko bizkarrak,
tente diran erruak, burni diran iztarrak.
– Gixonjale leyentzat jaki ziltzagilliak... –
Itxaso aundi orrek, zabal, zeru-atiak.
Erijotza or dabil, or dabil maitasuna.
Erri gogor onentzat, zeugan etorkixuna.
Odiseu barri gara, lamiñik ezta baña,
Emen sortuba ezta Aprodite liraña.
Geure abenda-antzo pioneer gaste gara.
Altzuan beti dozu irri baten ikara
Baña leoyen legez darresixu galparra.
¡Euzkoen itxasua!
¡Oldia eta indarra!
¡Aurrera, aurrerantza!
Ontzi-puntan soñutzik.
Axe oron mosubai bijotzak zabaldurik.
Ibilladi au ezta bixitzan amaituko;

En la tierra no sabíamos soñar y ahora vemos en el seno del agua el reflejo del cielo.

¡Oh, nuestro indomable mar! Remadores de ideas, saludamos a la luz de los mares. Tu sabes domar los cuerpos, pero mucho más las almas.

Como en nuestro corazón, en tí también existe una inquietud.

¿Quién conocerá tu profundidad? Eres un misterio impenetrable.

El mugido de tu tempestad es el temblor de los cobardes.

Tan sólo los vascos cruzan tu dilatado seno;

en la profundidad de sus ojos has derramado la osadía.

Forjas luchadores, dorsos de bronce, músculos en tensión, muslos de hierro.—Manjares tentadores para las ansias de los antropófagos.—

¡Oh mar inmenso, entreabe las puertas de cielo!

En tí camina la muerte, en tí sonríe el amor.

Para este pueblo vigoroso en tu seno está el porvenir.

Somos nuevos Ulises, pero no hay sirenas. Aquí no tuvo su cuna la encantadora Afrodita.

Como nuestra raza, somos jóvenes pionners. En tu anchura tienes siempre un temblor de sonrisas, pero sacudes tu melena, como un león.

¡Mar de los vascos! Impetu y vigor. ¡Adelante, siempre adelante!

Desnudos en la proa del barco, abiertos los corazones al beso de todos los vientos. Jamás ha de terminar esta peregrinación. Una vez de embarcados no busqueis el volver de nuevo.

Dejad en la tierra los dolores, quédense los que andan tristes.

Y venid vosotros los heridos por la esperanza, que nuestros afanes son los vuestros.

Los cielos están azulados, los ojos brillan de alegría.

Bein ontziratu danik barriz ezta itzuliko.
¡Miñak lurrean itxi, begoz itun diranak.
Itxaroz kezkatubak nai dabez geure lanak.
Zerubak argi dagoz, begoz pozez begijak
Uñen ganian dabiltz geroko abestiak...
Barriro esi daigun ludijaren gerrija,
Ez bitsez, ez indarrez, gogayakaz baño.
Itxaruak berua euzkotarren ontzija
Goguak nausi diran argitasun goiraño.

Sobre las ondas divagan los cantos de mañana...

Otra vez hemos de circundar el cinturón de la tierra, pero no con espuma ni esfuerzos vanos, sino con ideas.

Porte la barca de los vascos, la esperanza,

¡hasta las alturas de la claridad donde las almas son las únicas que reinan!



# Uarra

«Bide-barrijak» amaitu doguz. Batzuk arrika egingo dauste, beste batzuk goralduko nabe. Eztot gixonakaitik egin, Aberrijagaitik baño. Olerkari nazala agertutiari enago, izkuntza onetan be gogai batzuk azaldu daikeguzala erakustiari bai'ostera. Or-an entzun eta ikasi dodazan gogai-batzuk neure bijotzaren-barnetik euzkeralduta, agertu dodaz.

Gastaroko neurtitzok eztira sakonak, eztira gurenak, gauza guren eta sakonik gastaruan eztalako egiten. Geruago Aberrijarri yagokozan neurtitzak egingo dodaz. Euzkadi Amaren maitasunak jo-naulako.

Maitasunak sortu-azoten dauz neurtitzik ederrenak, eta maitasun-bidetan azkena-barik, lenengua naz. Maitasuna, Aberrija ta Uskurtza ixan dira gairik ugarijenak olerkarijentzat, neuretzako be bardin. Ludiko gairik kutuneak onexek yataz, Jel-pian esituta.

Olerkarija barik Jeltzale benetakua nazala entzutiak, atseginduko nau. Euskeraz idazten dot, Aberrijaren izkuntza dalako. Soluan atxurretan aberrija goralduko nebala, uste ba'neu, laster itxiko neuke lan au. Urtzi'k begi-onakin ikusten daulako Aberrijak goralduten ñidardubenen lana, kezka-barik nabil.

Eta atsegin etzakonak, neure aurka itz-eginke, idazti eder bat argitaldu-begi, bide-ori dalako gixon-argijena. Itz-egiteko bidian dagoz, euzkeraz idatzi dabenak, bestiak ez, lanaren neurrija, biar-egin dabenak dakilako.

Agur, eta Aberrija maitatu, Jaungoikua'ren urrengo.

*Egilliak.*

# Advertencia

«Nuevos Rumbos» lo hemos terminado ya. Unos me apedrearán por mi labor; otros más benignos, se dignarán aplaudirme. No he trabajado por los hombres sino por mi Patria. Me desagrada el que me llamen poeta, porque lo único que he pretendido es demostrar que en euzkera se pueden cristalizar algunas ideas. Diversos pensamientos, que he leido aquí y allí, han brotado desde el fondo de mi corazón, traducidos al euzkera.

Estos versos de mi juventud no son profundos ni trascendentales, porque en la juventud—casi infancia es la mía—no se pueden llevar a buen término cosas trascendentales. Más tarde cincelaré versos que canten a la Patria, porque me ha herido el amor de mi Madre Euzkadi.

El amor hace brotar los versos más hermosos y en estos caminos del amor no me considero el postrero. El Amor, la Patria y Dios han sido los temas más amplios para los poetas y creo lo serán también para mí. Los temas más queridos de mi vida son estos tres, concretados en *Jel.*

Mi mayor placer será el escuchar que soy verdadero *jeltzale* —patriota vasco—y no un poeta. Escribo en euzkera, porque es el idioma de mi Patria. Si creyera que labrando la tierra con un azadón había de enaltecer a mi Patria, dejaría al momento estos trabajos. Pero sé que Dios mira con buenos ojos a quienes, según sus fuerzas, se esfuerzan en glorificar a su Patria.

No sufro inquietud alguna por esta razón.

Y aquel a quien no placiere mi labor, procure publicar un bello libro, sin entretenerse en hablar contra mí, porque es el sendero único de los hombres preclaros. Tan solo me pueden criticar quienes hayan escrito en euzkera, porque saben apreciar lo que cuesta, quienes lo han intentado.

Adiós, y ama siempre a tu Dios y a tu Patria.

*El Autor.*

